EBANYELIO SAINDUA

# SAN JOANESEN

## ARABERA

LAPURDICO ESCUARARAT ITÇULIA.

BAYONNE:

1887.

JESU-KRISTOREN EBANJELIO

# SAINDUA JOANESEN

## ARABERA.

### I. KAP.

HASTAPENEAN
zen Hitza, eta Hi-
tza, Jainkoaren baitha
zen, eta Hitza Jainko
zen.
2 Hastapenean Jain-
koaren baithan zen.
3 Gauza guziak harek
eginak dire, eta egina
denik ez da hura gabe
egin deusere.
4 Haren baithan zen
bizia, eta bizia gizonen
argia zen.
5 Eta argiak ilhum-
beetan argitzen du, eta
ilhumbeek ez dute eza-
gutu.
6 Jainkoak igorria,
gizon bat izatu da Jo-
anes deitzen zena.
7 Hura ethorri zen
lekhukotzat, argiari e-
man ziozon lekhukota-
sun, orok haren ariaz
har zezaten sinheste.
8 Hura etzen argia,
bainan zen argiari le-
khukotasun bihurtzeko.
9 Hau zen argi egiaz-
koa, mundu huntara
dathortzen gizon guziak
argitzen dituena.
10 Munduan zen, eta
berak egin zuen mun-
dua, eta munduak ez
du ezagutu.
11 Ethorri da bere i-
zateetara eta bereek ez
dute onhetsi.
12 Bainan zembatek-
ere onhetsi baitute,
hainei eman diote Jain-
koaren ume bilhakatze-
ko ahala, hainei zeinek
haren izenean sinheste
baitute;

13 Zeinak ez odoletik, ez haragiaren nahitik, ez gizonaren oldetik, bainan Jainkoaren ganik baitire sorthu.

14 Eta Hitza haragi egin izan da, eta egotu da gure artean, graziaz eta egiaz bethea, eta ikhusi izan dugu haren ospea, Aita ganikako seme bakharraren ospea bezala.

15 Joanesek hartaz bihurtzen du lekhukotasun, eta oihu egiten du dioelarik: Hau zen nik erraten nuena: Ene ondotik ethortzekoa dena, ene gaineko ezarria da, zeren ni baino lehenagokoa baitzen.

16 Eta guk izatu dugu guziek haren bethetasunetik, eta grazia graziaren ordain.

17 Alabainan Moisesez emana izan da legea; grazia eta egia Jesu-Kristoz dire egin.

18 *Egundaino* nihork ez du Jainkoa ikhusi; Seme bakharrak, Aitaren galtzarrean denak, harek da ezagutarazi.

19 Eta hau da Joanesen lekhukotasuna, Jerusalemdik Juduek aphez eta lebitar batzu bidali ziozkatenean galdegitera: Nor zare zu?

20 Eta aithortu zuen, eta ez ukhatu, eta aithor hau eman zuen: Ez naiz ni Kristo.

21 Eta galdatu zioten: Zer zare bada? Elias zare zu? Eta erran zuen: Ez naiz hura. Profeta zare zu? Eta ihardetsi zuen: Ez.

22 Erran zioten beraz: Nor zare, ihardets diozotegun bidali gaituztenei? Zer diozu zure buruaz?

23 Erran zuen: Ni naiz hainaren mintzoa, zeinak mortuan oihu

egiten baitu: Aphain
zazue Jaunaren bidea,
Isaias profetak erran
izan duen bezala.
24 Eta haren ganat
igorriak zirenak, Fari-
sauetarik ziren.
25 Eta galdatu eta
erran zioten: Zer hari
zare bathayatzen, ez
bazare ez Kristo, ez-
eta Elias, ez-etare pro-
feta?
26 Joanesek ihardetsi
zaroten, zioelarik: Nik
urean dut bathayatzen;
bada ordean zuen erdian
bertze bat, zuek ezagu-
tzen ez duzuena.
27 Hura da ene ondo-
tik ethortzekoa dena,
ene gaineko ezarria
dena; ni ez bainaiz
haren oinetakoen lo-
kharriaren urratzeko
ere.
28 Haukiek gerthatu
ziren Bethanian, Jor-
danez haindian, non
hari baitzen Joanes ba-
thayatzen.
29 Biharamunean Jo-
anesek ikhusi zuen Je-
sus heldu zitzayoela,
eta erran zuen: Huna
Jainkoaren bildotsa,
huna munduaren be-
khatua khentzen due-
na.
30 Hau da haina, ze-
intaz erran baitut:
Ene ondotik dathor gi-
zon bat, nitaz gorago
ezarria dena, zeren ni
baino lehenago bai-
tzen.
31 Eta nik ez nuen
ezagutzen; bainan Is-
raelen ezagutua izan
dadien, hargatik ethorri
naiz ni urean bathaya-
tzera.
32 Eta Joanesek le-
khukotasun bihurtu
zuen, zioelarik: Ikhusi
dut nik Izpiritua uso
bat iduri zerutik jau-
sten, eta hunen gaine-
an gelditu da.
33 Eta nik ez nuen
ezagutzen; bainan ure-
an bathayatzen hari-

tzera bidali nauenak,
hainak erran izan darot: Zeinaren gainerat
ere ikhusiren baituzu
Izpiritua jausten eta
haren gainean gelditzen, hura da Izpiritu
sainduan bathayatzen
duena.
34 Eta ikhusi dut nik,
eta lekhukotasun bihurtu dut, hau dela
Jainkoaren Semea.
35 Ondoko egunean,
Joanes han jarri zen
berriz, eta haren bi dizipulu ere-bai.
36 Eta ikhustearekin
Jesus bideaz zihoala,
erraten du: Horra Jainkoaren bildotsa.
37 Bi dizipuluek aditu zuten mintzatzen,
eta jarraiki ziren Jesusi.
38 Eta itzulirik, eta
jarraikitzen zitzaizkola
oharturik, Jesusek erraten diote: Zeren ondoan zabiltzate? Hekiek ihardetsi zioten:
Rabbi (erran-nahi-baita Nausia), non egoten
zare?
39 Erraten diote: Zatozte eta ikhusazue.
Goan ziren eta ikhusi
zuten non zagoen, eta
haren baithan egotu
ziren egun hura; ezen
hamar orenetako heina
zen.
40 Bada, Andres, Simon Piarresen anaya,
Joanesen ganik aditu
zuten, eta Jesusi jarraiki ziren bietarik bat
zen.
41 Harek atzematen
du lehembizikorik Simon, bere anaya, eta
erraten dio: Aurkhitu
dugu Mesias (erran-nahi-baita Kristo).
42 Eta erakharri zuen
Jesusen gana. Jesusek
begiratu ondoan, erran
zioten: Zu, Simon zare
Joanesen semea; deithuko zare Zephas (horrek erran nahi baitu
Harria).

43 Biharamunean Jesusek nahi izan zuen Galileara ilkhi, eta aurkhitu zuen Filipe, eta erran zioen: Jarraik zakizkit.

44 Bada, Filipe Bethsaidako zen, Andresen eta Piarresen hiri berekoa.

45 Filipek atzematen du Nathanael eta erraten dio: Aurkhitu dugu Moisesek legean iskribuz eta profetek aiphatu dutena, Jesus Nazarethekoa, Josepen semea.

46 Eta Nathanaelek erraten dio: Zerbait onik athera othe diteke Nazarethetik? Filipek ihardesten dio: Zato eta ikhusazu.

47 Jesusek ikhusten du Nathanael heldu zayoela, eta hartaz erraten du: Huna zinez Israeldar bat, zeinaren baithan maltzurkeriarik ez baita.

48 Nathanaelek erraten dio: Nondik ezagutzen nauzu? Jesusek ihardesten eta erraten dio: Filipek deith zintzan baino lehen, piko azpian zinaudelarik, ikhusi zaitut.

49 Nathanaelek ihardesten eta erraten dio: Rabbi, zu Jainkoaren Semea zare, zu zare Israelgo Errege.

50 Jesusek ihardesten eta erraten dio: Sinhesten duzu, zeren erran darotzudan: Piko azpian ikhusi zaitut; hori baino handiagorik ikhusiren duzu.

51 Eta erraten dio; Egiazki derratzuet nik, ikhusiren ditutzuela zerua idekia eta Jainkoaren aingeruak igaiten eta jausten gizonaren Semearen gainera.

## II. KAP.

HANDIK hirugarren egunean, eztei batzu egin ziren Kana Galileakoan, eta han zen Jesusen ama.

2 Bada, Jesus ere eta bere dizpuluak ezteyetara deithuak izan ziren.

3 Eta arnoa eskastera baitzihoan, Jesusi erran zioen bere amak: Arnorik ez dute.

4 Eta Jesusek erran zioen: Emaztekia, zer da ene eta zure arteko? ene ordua ez da ethorria oraino.

5 Haren amak erraten diote sehiei: Zer-ere erranen baitarotzue, eta hura eta hura egizue.

6 Bada, han baziren sei untzi harrizko, Juduen chahualdietakotzat ezarriak, bizpahiruna metreta zadukatenak.

7 Jesusek erraten diote: Urez bethe zatzue untziak. Eta bethe zituzten gaineraino.

8 Eta Jesusek erraten diote: Erautsazue orai, eta eremozue mahain arthatzaileari. Eta eraman zuten.

9 Bada, mahain arthatzaileak dastatu zueneko arno bilhakatua zen ura, (nola ez baitzakien nondik heldu zen, bainan ura ekharri zuten sehiek bazakiten), deitzen du jaun esposa,

10 Eta erraten dio: Nor-nahik hastetik mahainean ezartzen du arno ona, eta tcharragoa, jendea edana denean; zuk aldiz, orai arteo iduki duzu arno ona.

11 Hori egin zuen Jesusek bere lehembiziko sendagaila, Kana Galileakoan, eta ezagutarazi zuen bere ospea, eta haren baithan sinhetsi zuten haren dizipuluek.

12 Gero jautsi zen Kapharnaumera eta harekin batean haren ama, anayak eta dizipuluak, eta han etzuten eman hambat egun.

13 Hurbil zen Juduen Bazko, eta Jesus igan zen Jerusalemera;

14 Eta temploan atzeman zituen idi, ardi eta uso saltzaile batzu, eta diru aldatzaileak jarriak.

15 Eta azotea bezalako bat eginik sokatto batzuz, templotik iraizi zituen oro, ardiak eta idiak ere, eta ichuri zituen aldatzaileen diruak eta mahainak uzkaili.

16 Eta uso saltzaileei erran zioten: Khen zatzue horiek hemendik, eta ene Aitaren etcheaz ez egin tratuko etche bat.

17 Orhoitu ziren orduan haren dizipuluak nola den iskribatua: Zure etchearen alderako kharrak erretzen hari nau.

18 Jabetu ziren beraz Juduak, eta erran zioten: Zer ezagutkariz erakhutsiko darokuzu, baduzula horien egiteko eskua?

19 Jesusek ihardetsi eta erran zioten: Urra zazue templo hau, eta chutituko dut hirur egunik barnean.

20 Horren gainean Juduek erran zuten: Berrogoi eta sei urthe eman dituzte templo hunen egiten, eta zuk hirur egunez eginen baituzu?

21 Jesus mintzo zen ordean bere gorphutzeko temploaz.

22 Hiletarik biztu zenean beraz, haren dizipuluak orhoitu ziren hori erran izan zuela, eta sinhetsi zituzten Iskritura eta Jesusek erran hitza.

23 Bada, nola Jerusalemen baitzen Bazko bestetan, askok, ikhusirik harek egiten zituen sendagailak, sinheste hartu zuten haren izenean.

24 Bainan Jesus etzagoen hekien gainean, zeren-eta ezagutzen baitzituen oro,

25 Eta beharrik ez baitzuen, nihork lekhukotasunik egin ziozon nihoren gainean; alabainan bazakien berak zer zagoen gizonaren barnean.

## III. KAP.

BADA, bazen Fariseauen arteko gizon bat, Nikodemo deitzen zena, Juduetan aitzindari.

2 Hura Jesusen gana ethorri zen gabaz, eta erran zioen: Nausia, badakigu irakhasle zarela Jainkoaren ganik ethorria; alabainan zuk egiten duzun holako sendagailarik nihork ez dezake egin, non ez den Jainkoa harekin.

3 Jesusek ihardetsi eta erran zioen: Zin-zinez derratzut nik, nihork ezin ikhus dezakeela Jainkoaren erresuma, berritan sort ez badadi.

4 Nikodemok erraten dio: Gizona nola sor daiteke berriz, behin zahartua denean? bigarrenean sar othe daiteke bere amaren sabelean, eta berritan sort?

5 Jesusek ihardesten du: Egiazki egiazki darotzut erraten, uretik eta Izpiritu saindutik sortzen ez dena, ezin sar daitekeela Jainkoaren erresuman.

6 Haragitik sorthua, haragi da: eta izpiritutik sorthua, izpiritu.

7 Ez harri, zeren erran darotzudan: Premia

da berritan for zaitez-
ten.
8 Haizeak nahi duen
aldea jotzen du, eta
aditzen duzu haren
harrabotsa, bainan ez
dakizu nondik heldu
den, ez norat dihoan;
hala-hala da izpiritutik
sorthua denaz.
9 Nikodemok ihar-
detsi eta erran zioen:
Nola egin daizteke ho-
riek?
10 Ihardetsi zuen Je-
susek eta erran zioen:
Irakhasle zare Israelen,
eta etzare horietaz ja-
kintsun?
11 Egiazki, egiazki
erraten darotzut, daki-
gunaz garela mintzo,
eta ikhusi dugunaz e-
giten dugula lekhuko-
tasun, eta gure lekhu-
kotasuna ez duzue on-
hesten.
12 Baldinetaria, ni
zuei lurreko gauzez
mintzatu, eta ez badu-
*zue sinhesten*; nola sin-
hetsiren duzue, zeru-
koez mintzatzen bana-
tzaitzue?
13 Nihor ez da zeru-
rat igan, zerutik jautsi
dena baizik, gizonaren
Semea, zeina zeruetan
baita.
14 Eta nola Moisesek
mortuan altchatu bai-
tzuen sugea, hala gizo-
naren Semea behar da
izan goratua;
15 Edozein, haren
baithan sinheste duenik
gal ez dadien, aitzitik
izan dezan bethiko bi-
zitzea.
16 Alabainan Jainko-
ak haletan du mundua
maithatu, non bere
Seme bekharra eman
baitu, hunen baithan
sinhesten duen nihor
ez dadien gal, aitzitik
izan dezan bethiko bi-
zitzea.
17 Ezen Jainkoak
mundurat igorri du
bere Semea, ez mun-
duaren juyatzera, bai-

nan haren bidez salba
dadien mundua.
18 Hunen baithan
sinheste duena ez da
juyatua; bainan sin-
hesten ez duena, oraitik
juyatua da, sinhesterik
ez duelakoz Jainkoaren
Seme bakharraren ize-
nean.
19 Bada, huna juya-
mendu horren aria:
argia baino nahiago i-
zan dituzte ilhumbeak
maithatu; ezik egitate
tzarrak zituzten.
20 Alabainan gaizki
egiten hari denak hi-
guin du argia, eta ez
da argirat hurbiltzen,
ager ditezen beldurrez
haren eginkariak.
21 Bainan egia bethe-
tzen duena, argira heldu
da, ager ditezen haren
egintzak, zeren Jainkoa
baithan eginak baitire.
22 Haukien ondoan,
ilkhi zen Jesus, eta ha-
ren dizipuluak ere, Ju-
*deako lurrera;* eta han
zagoen hekiekin, eta
hari zen bathayatzen.
23 Bada, Joanes ere
bathayatzen hari zen
Enonen, Salimgo on-
doan, ur hainitz baze-
lakoz aurkhintza har-
tan, eta jendea ethor-
tzen zen eta bathayatua
izaten zen;
24 Ezik Joanes etzen
preso ezarria izan o-
raino.
25 Bada, Joanesen
dizipuluek Judekin
makhur zerbait izatu
zuten chahupenaren
gainetik.
26 Eta ethorri ziren
Joanesen gana, eta
erran zioten: Nausia,
Jordanez haindian zu-
rekin zena, zeinari le-
khukotasun bihurtu
baitiozu, hara hura ere
bathayatzen hari dela,
eta haren gana doazi
guziak.
27 Joanesek ihardetsi
zuen eta erran: Deu-
sere ez dezake izan gi-

zonak, zerutik ematen
ez bazayo.
28 Zerorrek lekhuko-
tasun bihurtzen darota-
dazue, erran dudala:
Ez naiz ni Kristo, bai-
nan haren aitzinean
izan naiz bidalia.
29 Andre esposa due-
na, hura da jaun espo-
sa; bainan jaun espo-
saren adiskidea, haren
lagun ethorria eta haren
entzuten dagoena, boz-
karioz da bozten, adi-
tzen duelakoz jaun es-
posaren mintzoa. Be-
raz halacheko bozkarioa
bethea da ene baithan.
30 Hura behar da
berhatu; ni berriz,
gutitu.
31 Gainetik dathor-
rena, guzien garai da.
Lurretikako dena, lur-
rekoa da, eta lurtiar
hitzak ditu; zerutika-
koa dena, ororen gaine-
ko da.
32 Eta zer-ere ikhusi
eta aditu baitu, hartaz
lekhukotasun egiten
du; eta nihork ez du
onhesten haren lekhu-
kotasuna:
33 Haren lekhukota-
suna onhetsi duenak,
aithor bihurtzen du zina
dela Jainkoa.
34 Ezen Jainkoak bi-
dalia denak, Jainkoaren
hitzak erraten ditu;
Jainkoak alabainan ez
du neurtuz ematen
izpiritua.
35 Aitak maite du
Semea, eta haren eskue-
tara eman ditu gauza
guziak.
36 Semearen baithan
sinhesten duenak badu
bethiereko bizitzea;
aldiz Semearen alderat
sinhestegabe denak ez
du bizitzea ikhusiren,
bainan Jainkoaren ha-
sarrea haren gainean
dago.

## IV. KAP.

JESUSEK nabaritu zuenean beraz, nola Farisauak entzunak ziren, Joanesek baino dizipulu gehiago egiten eta gehiago bathayatzen zuela Jesusek,

2 (Nahiz Jesus etzedin bathayatzen hari, bainan bai haren dizipuluak),

3 Utzi zuen Judea, eta goan zen berriz Galileara.

4 Bada, Samaria barna iragan behar zen.

5 Ethorri zen beraz Samariako hiri, Sikar deitzen den batera, Jakobek bere seme Josepi eman izan zioen lurretik hurbil.

6 Han zen ere Jakoben ithurria. Jesus beraz bideaz nekhatua, jarri zagoen hala ithurri gainean. Sei orenetako iria zen.

7 *Samariako* emazteki bat urketa ethorri zen. Jesusek erraten dio: Indazu edatera.

8 (Dizipuluak ezen jateko erostera goanak ziren hirira.)

9 Samariar emazteki harek erraten dio beraz: Zu, Judua izaki, eta nolaz galdatzen darotadazu edatera naizen bezalako emazteki Samariarrari? Judek alabainan ez dute Samariarrekin ihardukitzen.

10 Jesusek ihardetsi eta erran zioen: Ezagutzen bazindu Jainkoaren dohaina, eta nor den zuri erraten darotzuna: Indazu edatera, zu abiatuko zinarozkion beharbada galdeka, eta emanen baitzarotzun ur bizi batetarik.

11 Emaztekiak erraten dio: Jauna, ez duzu eta zertaz athera ere, eta putzua barrena da; nondik zinuke beraz ur bizia?

12 Ala gahiago othe zare gure aita Jakob baino, zeinak eman izan baitaroku putzua, berak ere huntarik edan izan baitu, eta haren umeek eta haren aziendek ere ?

13 Jesusek ihardetsi eta erran zioen : Edozeinek edan dezan ur huntarik, egarrituren da berriz ; nik emanen diodan uretik edanen duena ordean, ez da behinere egarrituren ;

14 Bainan nik emanen diodan ura, bilhakaturen da ithurri bat bethiereko bizitzeraino joko duena.

15 Emaztekiak erraten dio : Ur hartarik indazu niri, Jauna, gehiago ez nadientzat egarri, ez-eta ethor hunat urketa.

16 Jesusek erraten dio : Zoaz, deith zazu zure senharra, eta zato hunat.

17 Emaztekiak ihardetsi eta erran zioen : Ez dut senharrik. Jesusek erraten dio : Ongi diozu : Ez dut senharrik ;

18 Ezen izan ditutzu bortz senhar, eta orai duzuna, ez da zure senharra ; hori egia erran duzu.

19 Emaztekiak erraten dio : Jauna, ikhusten dut profeta zarela zu.

20 Gure arbasoak mendi horren gainean haritu dire adoratzen ; eta zuek diozue, Jerusaleme dela tokia, zeintan behar baita adoratu.

21 Jesusek erraten dio : Emaztekia, sinhets nezazu, zeren heldu baita ordua, non ez baituzu ez mendi hortan ez-eta Jerusalemen adoraturen Aita.

22 Zuek ezagutzen ez duzuena adoratzen duzue ; guk ezagutzen duguna adoratzen dugu ;

alabainan Juduetarik dathor salbamendua.
23 Bainan heldu da ordua, eta orai da, non egiazko adoratzaileek, izpirituz eta zintasunean baituteadoraturen Aita; halabadere Aitak holako adoratzaileak ditu galdatzen.
24 Jainkoa izpiritu da, eta hura adoratzen dutenek, izpirituz eta zintasunean behar dute adoratu.
25 Emaztekiak erraten dio: Badakit badathorla Mesias (errannahi-da Kristo); hura dathorkeenean, orotaz argituren gaitu.
26 Jesusek erraten dio: Hura, ni naiz, mintzo natzaitzun berbera.
27 Eta hambatekin ethorriziren dizipuluak, eta harritzen ziren emazteki batekin zelakoz mintzo. Guzia ga*tik, nihork etzuen* erran. Zer galdatzen duzu, edo nolaz mintzo zare horrekin?
28 Bada, emaztekiak utzi zuen bere pegarra, jo zuen hirira, eta erraten diote hango gizone:
29 Zatozte, eta ikhusazue gizon bat, zeinak erran baitarozkit egin izan ditudan guziak: hura othe da bederen Kristo?
30 Ilkhi ziren beraz hiritik, eta Jesus gana zihoazen.
31 Bizkitartean dizipuluek othoizten zuten, ziotelarik: Nausia, jan zazu.
32 Bainan harek ihardesten diote: Zuek ez dakizuen janhari bat badut nik hartzeko.
33 Hargatik dizipuluek zerasaten batak bertzeari: Norbaitek jatera ekharri othe dio?
34 Jesusek erraten diote: Ene janharia da, egitea bidali nauenaren

nahia, osoki bethe deza-
dan haren ganikako
lana.
35 Zuek ez othe du-
zue erraten, oraino ba-
direla lau hilabethe,
eta orduan ethorriren
dela uzta ? Huna non
erraten darotzuedan
nik : Goiti zatzue be-
giak, eta ikhusazue
bazterrak jadanik chu-
hailduak direla uz-
taren egiteko heinerai-
no.
36 Eta uzta biltzen
duenak izaten du saria,
eta fruitu altchatzen
du bethiereko bizitze-
rako ; eraileak eta bil-
tzaileak, biek batean
har dezaten bozkario.
37 Ezen hortan egia
gerthatzen da erran
hau : Bertzerik dela
erailea, eta bertzerik
biltzailea.
38 Zuek bidali zaituz-
tet nik, lanthu ez du-
zuen lurrean biltzera ;
bertze batzu haritu dire
lantzen, eta zuek hekien
lanetan zarete sarthu.
39 Bada, hiri hartarik
Samariar askok Jesusen
baithan sinheste hartu
zuten, lekhukotasun
bihurtzen zuen emazte-
kiaren hitz hunen gai-
nean : Baizik-eta erran
baitarozkit egin izan
ditudanak oro.
40 Samariarrak e-
thorri zirenean beraz
haren gana, othoiztu
zuten hekien tokian e-
goteaz ; eta han egotu
zen bi egun.
41 Eta hainitz gehia-
gok sinhetsi zuten ha-
ren baithan, egin zituen
solasen ariaz.
42 Eta emaztekiari
erraten zioten : Orai-
kotik ez dugu zure er-
ranaren gainean sin-
hesten ; ezen geronek
entzun dugu, eta bada-
kigu hau dela mundua-
ren Salbatzailea.
43 Bada, bi egunen
buruan ilkhi zen han-

dik, eta goan zen Galileara.

44 Ezen Jesusen beraren ahoko hitza da, profeta batentzat ez dela ikhustaterik haren herrian.

45 Ethorri zenean beraz Galileara, ontsa hartu zuten Galilearrek, zeren ikhusi baitzituzten Jerusalemen besta egunean egin zituen guziak; ezik berak ere bestan izatuak ziren.

46 Goan zen beraz berritan Kana Galileakora, ura arno egin zuen tokira. Eta han bazen aitzindari bat, zeinaren semea eri baitzen Kapharnaumen.

47 Harek aditu zuenean Jesus heldu zela Judeatik Galileara, goan zitzayoen, eta othoiztu zuen jauts zadien eta senda zezon bere semea, ezen hiltzera zihoakon.

48 Jesusek erran zioen beraz: Ez duzue sinhesten, non ez duzuen sendagailarik eta mirakulurik ikhusten.

49 Aitzindariak erraten dio: Jauna, zato ene semea hil baino lehen.

50 Jesusek ihardesten dio: Zoaz, zure semea ongi da. Gizonak sinhetsi zuen Jesusek erran hitza, eta basihoan.

51 Bada, hura orduko jausten hari zelarik, buruz buru egin zuten bere sehiek, eta berria eman zioten osagarritan zuela semea.

52 Galdegin zuen hekien ganik zer mugaz hobekitu zen haurra. Eta ihardetsi zioten: Atzo, zazpi orenetan, sukharrak utzi du.

53 Aitak ezagutu zuen beraz, hura zela ordua, non erran baitzioen Jesusek: Ongi da zure semea. Eta sinheste hartu zuten

harek eta haren etche
guziak.
54 Sendagaila hori
berriz. bigarrena egin
zuen Jesusek, Judeatik
Galileara ethorri ze-
nean.

## V. KAP.

HORIEZ geroz e-
thorri zen Juduen
besta, eta Jesus igan
zen Jerusalemera.
2 Bada, berriz, Jeru-
salemen ardi urtegi bat,
hebrearaz Bethsaida
deitzen zena, bortz lo-
rioekilakoa.
3 Eri, itsu, maingu,
alderdi ihardun hainitz,
hekietan etzanak ego-
ten ziren, uraren higi-
tzeari iguri.
4 Ezik Jaunaren ain-
gerua noizetik noizera
jausten zen urtegira, eta
higitxen zuen ura. Eta
urtegira lehembizikorik
jausten zena, ura higi-
tua izan ondoan, sa-
sualtzen zen, edozein
eritasunek zadukan
arren.
5 Bada, han bazen
gizon bat, hogoi eta
hemezortzi urthe har-
tan bere gaitzarekin
zena.
6 Jesusek ikhusi zue-
nean etzana, eta jakin
zuenean, ordukoz aspal-
dian hala zela, erraten
dio: Nahi zare sa-
sualdu ?
7 Eriak ihardesten
dio: Jauna, nihor ez
dut urtegira igorriko
nauenik, ura higitua
izaten denean; eta ni
nohan artean, bertze bat
jausten da ni baino le-
hen.
8 Jesusek erraten dio:
Jaiki zaite, har zazu
zure ohea, eta ibilzaite.
9 Eta han berean sa-
sauldua izan zen gizon
hura; eta hartu zuen
bere ohea, eta baza-
bilan. Bada, larum-
bata zen egun hura.

10 Hargatik Juduek sendatua izan zenari erraten zioten: Larumbata da, etzaitzu zilhegi zure ohearen eramatea.

11 Ihardetsi zioten: Nork-ere sendatu bainau, hainak erran izan darot: Har zazu zure ohea, eta ibil zaite.

12 Galdatu zioten beraz: Nor da gizon hura, zeinak erran baitarotzu: Har zazu zure ohea, eta ibil zaite?

13 Bainan etzakien nor zen sendatua izan zenak; ezen Jesus aldaratu zen hara bildua zen jende murrutik.

14 Geroago Jesusek aurkhitu zuen temploan, eta erran zioen: Horra sendatua zarela; bekhaturik ez egin gehiago, zerbait gaitzagorik gertha dakizun beldurrez.

15 Goan zen gizon *hura eta erran* zioten Juduei, Jesus zela hura sendatu zuena.

16 Aria hortaz Jesusi jazartzen zioten Juduek, horiek egiten zituelakoz larumbat egunean.

17 Bainan Jesusek ihardetsi zioten: Bethi hari da ene Aita, eta hari naiz ni ere.

18 Hargatik beraz are gehiago bilhatzen zuten Juduek haren hiltzea, ez ezik hausten zuelakoz larumbata, bainan zioelakoz Jainkoa zuela Aita, bere burua Jainkoaren bardin eginez. Aria hortaz Jesusek ihardetsi eta erran zioten:

19 Egiazki, egiazki derratzuet nik: Semeak bere baitharik ez dezake egin deusere, egiten ikhusten dioena baizik bere Aitari; ezen Aitak egiten dituenak oro, Semeak ere halaber egiten ditu.

20 Alabainan Aitak
maite du Semea, eta
erakhusten diozka be-
rak egiten dituen guzi-
ak; eta haukiek baino
handiagorik ere era-
khutsiko dio, zeronek
ederresten egonen bai-
tzarete.
21 Ezen nola Aitak
bizten baititu hilak eta
bizia baitaroe ematen,
halaber semeak ere nahi
duenari ematen dio bi-
zia.
22 Alabadere ez du
nihor juyatzen Aitak,
bainan Semeari eman
dio juyamendua oro;
23 Guziek ohora de-
zaten Semea, Aita oho-
ratzen duten bezala:
ohoratzen ez duenak
Semea, Aita ere, hura
bidali duena, ez du
ohoratzen.
24 Egiazki, egiazki
derratzuet nik, ene
hitza entzuten eta ni
bidali nauenaren bai-
than sinhesten duena,
bethiereko bizitzearen
jabe dela, eta ez dela
juyamenduaren azpira
erortzen, bainan herio-
tzetik bizitzera dela
iragaiten.
25 Egiazki, egiazki
erraten darotzuet, hel-
du dela ordua, eta orant-
chetan dela, non hilek
entzunen baitute Jain-
koaren Semearen min-
tzoa; eta entzunen
dutenak, biziko dire.
26 Alabainan nola
baitu Aitak bere bai-
than bizia, hala Semeari
ere eman dio bizia bere
baithan izatea.
27 Eta eman dio juya-
tzeko eskua ere, gizo-
naren Semea delakoz.
28 Hortaz ez baldi,
zeren heldu baita ordua
non hobietan diren
guziek entzunen bai-
tute Jainkoaren Semea-
ren mintzoa;
29 Eta ongi egin dute-
nak bizitzera bizteko
dire ilkhiren; gaizki

egin dutenak berriz,
juyamendura bizteko.
30 Nik ez dezaket ene
burutarik egin deusere;
nola aditu, hala juya-
tzen dut, eta zuzena da
ene juyamendua, ez
baitut ene nahia bilha-
tzen, bainan bai bidali
nauenaren nahia.
31 Ene buruaz nero-
nek egiten badut lekhu-
kotasun, ene lekhuko-
tasuna ez da egiazkoa.
32 Bertze bat da nitaz
lekhukotasun egiten
duena, eta badakit e-
giazkoa dela nitaz dak-
harren lekhukotasuna.
33 Zuek bidali duzue
Joanesen gana, eta ha-
rek egiari lekhukotasun
bihurtu izan dio.
34 Nik ez dut ordean
gizon lekhukotasunik
atheratzen; bainan
hunela mintzo naiz,
zuek salbarazi beharrez.
35 Hura zen zuzi su-
duna eta argia; zuek
*berriz, aphur bat* haren
argitara nahi izan za-
rete boztu.
36 Bainan nik lekhu-
kotasun bat badut Joa-
nesena baino handiagoa;
ezen egitera Aitak eman
darozkidan lanek, nik
egiten ditudan lanek
berek, nitaz lekhuko-
tasun dakharte, ene
Aitak bidali nauela.
37 Eta Aitak, ni bidali
nauenak, berak egin du
lekhukotasun nitaz;
eta zuek ez duzue haren
mintzoa entzun behi-
nere, ez-eta haren be-
githartea ikhusi;
38 Eta ez dadukazue
haren hitza zuen bai-
than gelditua; zeren
nor-ere bidali baitu,
haina ez baituzue sin-
hesten.
39 Ikhar zatzue Is-
kriturak, uste duzue-
naz geroz hekien bidez
izan bethiereko bizia;
hekiek dire bada, nitaz
lekhukotasun demate-
nak.

40 Eta ez duzue ene ganat ethorri nahi, biziaren izateko.

41 Ez dut ene ospea gizonetarik atheratzen.

42 Bainan ezagutzen zaituztet, zuen baithan Jainkoaren amodiorik ez duzuela.

43 Ni ene Aitaren izenean ethorri naiz, eta ez nauzue onhesten; bere izenean ethor balitzaitzue bertze bat, hura onhets zinezakete.

44 Nola sinhets dezakezue zuek, zeinek zuen ospea batzuek bertzeen ganik atheratzen baituzue eta ez bilhatzen Jainko bakharraren ganik dathorrena ?

45 Ez uste izan nik eratchikiren darotzuedala Aitaren aitzinean; zuen kontra jazartzen duena, Moises da, zeintan baituzue zuen pheskiza.

46 Ezen sinhets bazindezate Moises, ni ere sinhets nindezakezue eiki; harek alabainan nitaz iskribatu izan du.

47 Bainan harek iskribatuak ez badituztzue sinhesten, ene hitzak nola sinhetsiren dituztzue ?

## VI. KAP.

JESUS goan zen gero Galileako (errannahi Tiberiasako) itsasoaz haindira;

2 Eta bazarraikion jendetze handia, eri zirenen gainean egiten zituen sendagailak ikhusten baitzituzten.

3 Aldaratu zen beraz mendi batetara, eta han jarria zagoen bere dizipuluekin.

4 Bada, hurbil zen Bazko, Juduen besta eguna.

5 Jesusek begiak goititu eta ohartu zenean oste bat gaitza

heldu zitzayoela, erran zioen Filiperi : Nondik erosiko dugu ogia, jan dezaten horiek orok ?

6 Bada, haren frogatzeko erraten zuen hori, bazakien ezik zeren egitera zihoan.

7 Filipek ihardetsi zioen : Berrehun denarioren ogia ere ez lukete aski, bakhotchak izpi baten izateko.

8 Bere dizipuluetarik bertze batek, Andres, Simon Piarresen anayak, erraten dio :

9 Bada hemen muthiko bat, bortz garagar ogi eta bi arrain dituena ; bainan zer da hori hunembat gizonen arteko ?

10 Jesusek erran zuen beraz : Jarrazkitzue. Bada, toki hartan ederra zen belharra ; eta jarri zen bortz mila gizonen heina.

11 Jesusek hartu zituen beraz ogiak, eta

eskerrak bihurtu
doan, zathitu ziozk
jarriak zirenei, ets
rainetarik halaber
zuten bezembat.

12 Ase zirenean,
riz erran zioten di
luei : Bil zatzue s
ratu diren puzkak
ez ditezen.

13 Bildu zituzten
raz, eta bortz gar
ogietarik jaleei sobe
puskez bethe zitu
hamabi saski.

14 Gizon hekiek
raz, ikhusi zute
Jesusek egin sendag
erraten zuten : Ha
egiazki mundurate
tzekoa den pr
hura.

15 Jesusek eza
baitzuen ordean, et
tzekotan zirela h
hartzera eta er
egitera, berriz men
ihes egin zuen bak
rik.

16 Bada, arratsa
zeneko, haren di

luak jautsi ziren itsasora.

17 Eta untzi batera iganik, itsasoz haindira hari ziren Kapharnaumgo aldera; eta orduko ilhun beltza zen, eta Jesus etzen hekien ganat ethorria.

18 Bizkitartean, haize handi batek ematen baitzuen, hasarretzen hari zen itsasoa.

19 Beraz hogoi eta bortz edo hogoi eta hamar estadio bezala arrauka egin zituztenean, ikhusten dute Jesus itsasoaren gainean dabilala, eta untzirat hurbiltzen, eta izitu ziren.

20 Bainan harek erran zioten: Ni naiz, ez izi.

21 Nahi izan zuten beraz untzirat hartu, eta berehala untzia heldua gerthatu zen hekiek zihoazen leihorraren aldera.

22 Biharamunean, itsasoz hunaindian zagoen osteak ikhusten zuen han etzela gerthatu bertze untzirik bat baizen, eta Jesus etzela bere dizipuluekin untzira sarthu, bainan bakharrik goan zirela haren dizipuluak.

23 Bainan, Jaunak eskerrak bihurtu ondoan, ogia jan zuten tokiko bazterrera ethorri ziren orduan Tiberiastik bertze untzi batzu;

24 Ikhusirik beraz etzirela han Jesus ezetare haren dizipuluak, untzietara igan eta Kapharnaumera goan ziren Jesusen ondoan.

25 Eta itsasoz haindian aurkhiturik, erran zioten: Nausia, noiz ethorri zare hunat?

26 Jesusek ihardetsi eta erran zaroeten: Zin-zinez erraten darotzuet, bilhatzen nauzue, ez sendagailak ikhusi ditutzuelakoz, bainan

zeren jan duzuen ogitik eta ase zareten.

27 Berma zaitezte, ez galtzen den janhari baten gatik, bainan bethiereko bizitzeraino dirauenaren ariaz, zeina gizonaren Semeak emanen baitarotzuete; hau da ezen Jainko Aitak bere zigiluaren hatzaz berezi izan duena.

28 Hekiek erran zioten beraz: Zer eginen dugu Jainkoaren araberako eginkarietan haritzeko?

29 Jesusek ihardetsi eta erran zioten: Hau da Jainkoaren araberako lana, sinhets dezazuen ni bidali nauenaren baithan.

30 Haletan, Jesusi erran zioten: Eta zer sendagaila egiten duzu, hura ikhus eta zure baithan sinhets dezagun? zer egiten duzu?

*31 Gure* arbasoek mortuan jan izan dute mana, iskribatua den bezala: Jaterat eman diotet zerutikako ogia.

32 Jesusek erran zioten beraz: Egiazki, egiazki derratzuet nik: Ez darotzue Moisesek eman zerutikako ogia, bainan ene Aitak ematen darotzue zerutikako ogi egiazkoa.

33 Ezen Jainkoaren ogia da zerutik jausten dena eta munduari bizia ematen dioena.

34 Horren gainean, erran zioten hekiek: Jauna, iguzu bethi ogi hartarik.

35 Jesusek aldiz ihardetsi zioten: Ni naiz bizitzerako ogia: ene gana dathorrena ez da goseturen, eta ene baithan sinhesten duenak ez du behinere egarririk ezaguturen.

36 Bainan erran darotzuet, bai ikhusi nauzuela eta ez sinhetsi.

37 Aitak niri ematen daroztan guziak, ene ganat ethorriko dire; eta ene gana dathorrena ez dut kamporat iraiziren;

38 Zeren jautsi bainaiz zerutik, egiteko ez ene nahia, bainan bai bidali nauenaren nahia.

39 Huna bada, Aitaren, ni igorri nauenaren nahia, eman darozkidan guzietarik ez dezadan batere gal, bainan bitzaraz detzadan azken egunean.

40 Bada, ene Aita bidali nauenaren nahia hau da, Semea ikhusten eta sinhesten duten guziek, izan dezaten bethiereko bizitzea; eta nik bitzaraziren ditut azken egunean.

41 Erasiaka zauden bada Juduak haren kontra, zeren erran zuen: Ni naiz ogi bizia, zerutik jautsi naizena.

42 Eta zioten: Hori ez da Jesus, Josepen semea, zeinaren aitamak ezagutzen baititugu? Nolaz dio beraz horrek: Zerutik jautsi naiz ni?

43 Horren gainean, Jesusek ihardetsi eta erran zioten: Zuen artean ez erabil erasiarik:

44 Ene gana nihor ezin dathorke, non ene Aita ni bidali nauenak ez duen erakhartzen; eta nik hura bitzaraziren dut azken egunean.

45 Profetetan iskribatua da: Eta guziak izanen dire Jainkoaren irakhasmenaren menean; Aita entzun duten guziak, eta argitu direnak, eneganako dire.

46 Ez bada hori, nihork ikhusi duelakoan Aita, non ez Jainkoa ganikakoa denak; harek ikhusi du Aita.

47 Egiazki, egiazki

derratzuet nik: Nitan sinhesten duena da bethiereko bizitzearen jabe.

48 Ni naiz bizirako ogia.

49 Zuen arbasoek mortuan jan izan dute mana, eta hil izan dire.

50 Bainan huna zerutik jausten den ogia, huntarik janen duena, ez dadientzat hil.

51 Ni naiz ogi bizia, zerutik jautsi naizena.

52 Norbaitek ogi huntarik jaten badu, biziko da bethiere; eta nik emanen dudan ogia, da ene haragia munduaren biziarentzat.

53 Bada, Juduek elkharren artean jazartzen zuten: Horriek nola eman diazakegu jatera bere haragia?

54 Jesusek beraz erran zioten: Egiazki, egiazki derratzuet nik: *Non ez duzuen* jaten gizonaren Semearen haragia eta edaten haren odola, bizitzea ez duzue zuen baithan izanen.

55 Ene haragia jaten eta ene odola edaten duenak, badu bethiereko bizitzea; eta nik bizturen dut hura azken egunean.

56 Ezen egiazki ene haragia janhari da, eta ene odola edari da egiazki.

57 Ene haragia jaten eta ene odola edaten duena, ene bathan dago, eta ni haren baithan.

58 Nola Aita bizi denak igorri bainau, eta ni bizi bainaiz Aitaren ariatik, haina ere ene ariatik biziko da.

59 Hau da zerutik jautsi den ogia. Ez da zuen arbasoek jan duten mana iduri, eta gero hil izan baitire. Ogi huntarik jaten duena, bethi guzian da biziko.

60 Kapharnaumen erran zituen horiek, sinagogan irakhasten hari zelarik.

61 Beraz nola bere dizipuluetarik hainitzek entzuten baitzuten, erran izan zuten: Gogorra da solas hori, eta nork entzun ere dezake?

62 Jesusek ordean bere baithan baitzakien, hortaz erauntsian hari zirela haren dizipuluak, erran zaroeten: Hortaz gogoan behartzen zarete?

63 Ikhusten bazindute bada gizonaren Semea lehenago zen tokirat igaiten?

64 Izpiritua da bizia demana; haragia deusetako ez da baliatzen. Nik zuei erran hitzak, bizi eta izpiritu dire.

65 Badire ordean zuetarik batzu sinhesten ez dutenak. Ezen hastetik bazakien Jesusek zein ziren sinhesten etzutenak, eta nork salduko zuen bera.

66 Eta erraten zuen: Aria hortaz erran darotzuet, nihor ez dathorkeela ene gana, non etzayoen ene Aita ganik emana.

67 Ordutik haren dizipulu askok gibelerat egin izan zuten, eta etziren gehiago harekin ibiltzen.

68 Horren gainean Jesusek erran zioten hamabiei: Zuek ere goan gogo othe zarete?

69 Simon Piarresek ihardetsi zioen beraz: Jauna, noren gana gindohazke? Zuk ditutzu bethiereko bizitzeko hitzak.

70 Eta guk sinhetsi eta ezagutu dugu, zu zarela ezen Kristo Jainkoaren Semea.

71 Jesusek ihardetsi zioten: Zuek hamabiak ez othe zaituztet nero-

nek hautatu? Bizki-
tartean debru bat da
zuetarik bat.
72 Judas Iskariot,
Simonen seme a, zuen
aiphatzen, hura zen
ezik haren saltzaile
izan behar zena, hama-
bietarik bat zen arren.

## VII. KAP.

HANDIK harat
Galilean zabilan
Jesus; etzuen albainan
Judean ibili nahi, Ju-
duek haren hiltzea bil-
hatzen zutelakoz.
2 Bada, hurbildua
zen Juduen besta,
Tabernakleetakoa dei-
tzen dena.
3 Bere anayek erran
zioten beraz: Ilkhi
zaite hemendik eta
zoaz Judeara, hango
zure dizipuluek ere i-
khus detzazten zuk
egiten ditutzun gauzak.
4 Nihork ez du ala-
*bainan zerbait* egiten
gordeka, bere burua
agerira beharrez hari
denean. Horiek egiten
ditutzunaz geroztik,
munduari agerrozu zure
burua.
5 Ezen haren anayek
berek etzuten haren
baithan sinhesten.
6 Jesusek erran zio-
ten beraz: Ene ordua
ez da oraino ethorria;
noiz-nahi da ordean
zuen muga.
7 Munduak ez lezake
izan zuentzat gaitziriz-
korik; ni gaitzets nau
ordean, zeren lekhuko-
tasun haren kontra bi-
hurtzen baitut, tzarrak
direla haren eginkariak.
8 Zoazte zuek besta
hortara; ni ordean ez
naiz hortara goaten, ze-
ren ene eguna ez baita
oraino bethea.
9 Horiek erranik,
bera Galilean gelditu
zen.
10 Bainan goan zire-
neko haren anayak,

bera ere bestara goan
zen, ez ageriki, bainan
ichilka bezala.
11 Beraz besta egu-
nean, Juduak haren
bilha zabiltzan, eta er-
raten zuten : Non othe
da hura ?
12 Eta haren gainean
erasia handia zabilan
ahapetik jendeetan.
Ezik batzuek zioten :
Prestua da. Bertzeek
berriz, erraten zuten :
Ez da hala, bainan
jende amainatzaile bat.
13 Guzia gatik nihor
etzen, Juduen beldur-
rez, hartaz agerian
mintzo.
14 Bada, ordukoz
besta erditsutara ethor-
ria zelarik, Jesus igan
zen templora, eta ira-
khasten abiatu zen.
15 Eta baldituak
zauden Juduak, ziote-
larik : Hunek nondik
ditu jakitate horiek,
ikhasten egotu gabeta-
*rik ?*
16 Jesusek ihardetsi
eta erran zarocten :
Ene irakhasmena ez da
enea, bainan ni bidali
nauenarena.
17 Hainaren nahia
egin nahi badu nor-
baitek, ezaguturen du
hean irakhasmen hau
Jainkoaren ganikakoa
den, ala ene baitharik
naizen mintzo.
18 Bere burutarik
mintzo dena, bere bu-
ruari lelo ematera dar-
raikio ; nork-ere or-
dean bilhatzen baitu
bera igorri duenaren
gorestea, haina zina da,
eta zuzen ez denik ha-
ren baithan ez da.
19 Ez darotzue Moise-
sek eman legea, eta
zuetarik legea ez baitu
bethetzen nihork-ere ?
20 Zertan zabiltzate
ni hil beharrez ? Popu-
luak ihardetsi eta erran
zuen : Debruak zabil-
tza ; nork nahi zaitu
hil ?

21 Jesusek ihardetsi
eta erran zaroeten:
Gauza bat egin dut, eta
guziak harrituak zarete.
22 Bada, Moisesek
eman izan darotzue in-
gurephaitza (ez Moise-
sen ganikakoa delakoz,
bainan arbasoetarika-
koa), ingurephaiten du-
zue gizonkia larumbat
egunean ere.
23 Baldin ingurephai-
ten bada gizona larum-
bat egunez, Moisesen
legearen ez haustea
gatik, nolaz sumintzen
zakizkidate, zeren la-
rumbat egunarekin sa-
sualdu dudan gizon bat
bere gorphutz guzian ?
24 Ez juya itchuratik,
bainan juyamendu zu-
zen bat arthikazue.
25 Bada, Jerusalem-
darretarik zembaitek
erraten zuten: Ez othe
da hau hiltzeko bilha-
tzen duten hura ?
26 Huna non mintzo
*den guzien* aitzinean,
eta ez diote deusere
erraten. Buruzagiek
egiazki ezagutu othe
dute Kristo dela hau ?
27 Bainan badakigu
nongoa den hau; Kristo
ethorriko denean or-
dean, nihork ez du
jakinen nongoa den.
28 Jesusek beraz,
temploan irakhasten
hari zelarik, oihu egiten
zuen: Eta badakizue
nor naizen, eta bada-
kizue nondik heldu
naizen; eta bada, ez
naiz ene burutarik e-
thorria; bainan zina da
ni bidali nauena, hura
ez baituzue ezagutzen.
29 Nik ezagutzen dut
hura, zeren haren gani-
kakoa bainaiz ni, eta ha-
rek berak bainau igorri.
30 Juduak beraz hura
hartu beharrez zabil-
tzan; bainan nihork
etzioen eskua gainera
ezarri, zeren oraino
haren ordua ez baitzen
ethorria.

31 Bizkitartean popu-
lutik askok sinhetsi
zuten haren baithan,
eta erraten zuten:
Kristo ethorri ditekee-
nean, eginen othe du
hunek egiten duen
baino sendagaila gehi-
ago?
32 Farisauek aditu
zuten populua Jesusez
horien erasten hari zela;
eta buruzagiek eta Fa-
risauek beren gizone-
tarik igorri zituzten
haren hartzera.
33 Orduan Jesusek
erran zioten: Oraino
aphur bat zuekin naiz,
eta gero banoha bidali
nauenaren gana.
34 Bilhaturen nauzue,
eta ez aurkhituren; eta
ni izanen naizen tokira,
zuek ezin ethor zaitez-
kete.
35 Juduek beraz zera-
saten beren artean:
Norat goanen da, guk
ezin aurkhituren bai-
tugu? *Ala* orotan bar-
rayatuak diren jenda-
yetara goatekoa eta
hekiei irakhasten hari-
tzekoa othe da?
36 Zer da erran duen
hitz hau: Bilhaturen
nauzue, eta ez aurkhi-
turen; eta ni izanen
naizen tokira, zuek ezin
ethor zaitezkete?
37 Bada, bestako
azken egun handian,
han zen Jesus, eta oihu
egiten zuen, zioelarik:
Nihor bada egarri, be-
thor ene gana, eta edan
beza.
38 Ene baithan sin-
hesten duenari, Iskri-
turak dioen bezala, ur
bizizko ibayak jarioko
zaizko barnetik.
39 Bada, erraten zuen
hori, haren baithan
sinheste zutenak izate-
koa zuten Izpirituaren
ariaz; ezik oraino Iz-
piritua etzen emana,
zeren Jesus ez baitzen
oraino ospetan jarria.
40 Askok beraz jende-

tze hartarik, solas horiek aditu ondoan, erraten zuten: Egiazki profeta da gizon hori!
41 Bertze batzuek erraten zuten: Kristo da hori. Zembaitek berriz, zerraten: Galileatik ethorriren othe da Kristo?
42 Ez othe dio Iskriturak: Dabiden odoletik ethortzekoa dela Kristo, eta Bethlehemgo herritik, zeintakoa baitzen Dabid?
43 Jesusen gainetik horrelako eskatima altchatu zen beraz jendeen artean.
44 Bada, hekietarik zembaitek hartu nahi zuketen; bainan nihork etzuen eskua haren gainean ezarri.
45 Hartako igorri gizonak itzuli ziren beraz aphez nausietara eta Farisauetara. Haukiek erran zaroten: Nolaz ez duzue erakharri?
46 Hekiek ihardetsi zuten: Gizon hori bezala, egundaino ez da gizonik mintzatu.
47 Farisauek jazarri zioten: Atzemanak othe zarete zuek ere?
48 Buruzagietan, edo Farisauetan othe da nihor horri sinhesterik eman izan dioenik?
49 Ordean jende purruska, legea ezagutzen ez duten horiek, madarikatu batzu dire.
50 Beren artekoetarik batek, Nikodemok, Jesusen gana gauaz ethorri izan zen haretchek erran zioten:
51 Gure legeak juyatzen othe du gizona, non ez den lehenik entzuna, eta zer egin duen argitu gabe?
52 Nikodemori ihardetsi eta erran zioten: Galilearra othe zare zu ere? Ikhar zatzu Iskri-

turak, eta jakizu Galile-
atik ez dela profetarik
atheratzen.
53 Eta itzuli ziren
zein bere etchera.

## VIII. KAP.

BADA, Jesus goan
zen Olibadietako
mendira ;
2 Eta argitzean, berriz
ethorri zen templora,
eta populu guzia ethorri
zitzayoen, eta jarririk
irakhasten hari zitza-
yen.
3 Orduan Iskribauek
eta Farisauek erakharri
zuten emazteki bat,
bere senharraz bertze-
kin lohikerian atze-
mana ; eta guzien
erdian ezarri zuten
chutik,
4 Eta erran zioten
Jesusi : Nausia, emaz-
teki hau orantche atze-
mana izan da lohi-
kerian.
5 *Bada,* Moisesek le-
gean manatu izan daro
ku harrika detzagun
holakoak. Zuk beraz,
zer diozu ?
6 Hori erraten zuten
bada, hura zertan khau-
si, gero zertaz jazar iza-
tea gatik. Bainan Je-
sus, beheiti bere burua
makhurtuz, erhiaz hari
zen lurrean iskribatzen.
7 Nola beraz aitzina
galdez baitzagozkion,
chuchendu zen, eta er-
ran zioten : Zuetarik
bekhatu gabea denak
arthik biozo lehembi-
ziko harria.
8 Eta berriz-ere ma-
khurturik, iskribatzen
zuen lurrean.
9 Bainan hekiek aditu
zutenean, bat bertzea-
ren ondotik ilkhi ziren,
zaharrenetarik hasirik ;
eta bakharrik gelditu
zen Jesus ; eta emaz-
tekia erdian chutik.
10 Bada, chuchendu-
rik, Jesusek erran zio-
en : Emaztekia, non

dire zuri jazartzen zu-
tenak? nihork konde-
natu zaitu?

11 Harek ihardetsi
zuen: Nihork, Jauna.
Aldiz Jesusek erran
zioen: Nik ere etzaitut
kondenatuko. Zoaz,
eta gehiago bekhaturik
ez egin.

12 Jesus oraino ere
mintzatu zen populu-
ari, zioelarik: Ni naiz
munduaren argia; niri
darraitana, ez dabila
ilhumbeka, eta izanen
du bizitzeko argia.

13 Horren gainean,
Farisauek erran zioten:
Zure buruari zeroni
atheratzen zatzaizkio
lekhuko; zure le-
khukotasuna ez da
zina.

14 Jesusek ihardetsi
eta erran zioten: Ene
buruari lekhukotasun
neronek egin diozadan
arren, zina da ene le-
khukotasuna, zeren bai-
takit nondik heldu nai-
zen, eta norat nohan;
zuek berriz, ez dakizue
nondik nathorren edo
norat nohan.

15 Zuek haragiaren
araberajuyatzen duzue;
nik, nihor ez dut ju-
yatzen;

16 Eta egiten badut,
zina da ene juyamen-
dua; zeren ez bainaiz
bakharrik; bainan ni
eta ni igorri nauena,
Aita.

17 Eta zuen legean
iskribatua da, zina dela
bi gizonen lekhukota-
suna.

18 Ni naiz ene buru-
ari lekhukotasun egiten
dudana; eta Aitak, ni
bidali nauenak ere le-
khukotasun ematen
darot.

19 Hekiek erraten
zioten beraz: Non da
zure Aita? Jesusek
ihardetsi zuen: Ez gai-
tuzue ezagutzen ez ni
ez ene Aita; ezagu-
tzen baninduzue ni,

ene Aita ere ezagut
bide zinezakete.
20 Jesusek khutchate
an erran zituen
solas horiek, irakhasten
hari zelarik temploan;
eta nihor etzitzayoen
lothu, zeren haren ordua
ez baitzen oraino
ethorria.
21 Berriz-ere erran
zioten Jesusek: Ni banoha,
eta bilhaturen
nauzue, eta zuen bekhatuan
hilen zarete.
Ni nohan tokira, zuek
ezin ethor zaitezkete?
22 Juduek beraz erraten
zuten: Berak hilen
othe du bere burua;
dio ezen: Ni nohan tokira,
zuek ezin ethor
zaitezkete?
23 Eta Jesusek erraten
zioten: Zuek, beheretikakoak
zarete; ni,
gainetikakoa naiz. Zuek,
mundu huntarikakoak
zarete; ni ez naiz
mundu huntarikakoa.
24 Aria hortaz erran
darotzuet: Zuen bekhatuan
hilen zaretela;
alabainan sinhesten ez
baduzue nor naizen ni,
zuen bekhatuan zarete
hilen.
25 Erraten zioten beraz:
Nor zare zu?
Jesusek ihardetsi zaroeten:
Guzien hatsarrea,
ni orai zuei mintzo
natzaitzuena.
26 Hainitz nuke zuetaz
errateko eta zuetan
azurriatzeko; bainan
zina da ni bidali nauena;
eta nik, zer-ere
baitut haren ganik entzun,
hura derrat munduan.
27 Eta hekiek etzuten
ezagutu erraten
zuela Jainkoa zela
haren Aita.
28 Jesusek erran zioten
beraz: Goititu dukezuenean
gizonaren
Semea, orduan ezaguturen
duzue nor naizen
ni, eta deusere ez dudala
ene burutarik egi-

ten, bainan nola irakhatsi baitarot Aitak, eta hala naizela mintzo;

29 Eta ni igorri nauena, enekin da; eta ez nau bakharrik utzi; zeren nik haren gogarako dena egiten baitut bethi.

30 Horiek erraten zituenean, askok sinheste hartu zuten haren baithan.

31 Jesusek beraz, sinhetsi zuten Juduei erraten zaroeten: Baldin zuek gogor egoten bazarete ene hitzean, egiazki ene dizipulu izanen zarete;

32 Eta ezaguturen duzue egia, eta egiak ezarriren zaituzte zuen buruen jabe.

33 Ihardetsi zioten: Abrahamen odoletik gare, eta egundaino nihoren meneko ez gare izatu; nolaz diozu: Zuen eskuko izanen *zarete ?*

34 Jesusek ihardetsi zioten: Egiazki, egiazki derratzuet nik, bekhatu egiten duena ezen, bekhatuaren gathibu dela.

35 Bada, gathibua ez dago bethi etche batean; semea ordean etchean dago bethiko.

36 Baldin beraz zuen eskukotasuna bademazue Semeak, egiazki zuen eskuko izanen zarete.

37 Badakit Abrahamen umeak zaretela; bainan ene hiltzea bilhatzen duzue, zeren ene hitzak zuen baithan ez baitu hartzen.

38 Nik erraten dut ene Aitaren baithan ikhusi dudana; eta zuek, zuen aitaren baithan ikhusi duzuena egiten duzue.

39 Ihardetsi eta erran zioten: Abraham da gure aita. Jesusek er raten daroe: Baldir Abrahamen seme baza

rete, Abrahamen egintzak egizkitzue.

40 Orai ordean ni hil beharrez zabiltzate, ni, gizon bat, Jainkoaren ganik aditu egia erran darotzuedana; Abrahamek holakorik ez du egin.

41 Zuen aitaren lanak egiten ditutzue. Ihardetsi zuten: Ez gare likhiskeriatik sorthuak; aita bakhar bat dugu, Jainkoa.

42 Jesusek erran zioten beraz: Jainkoa balitz zuen aita, eiki onhets nindezakezue. Ezen ni Jainkoaren ganik ilkhi naiz eta ethorri; ez naiz alabainan ene burutarik hunatu, bainan harek nau bidali.

43 Zergatik ez duzue ardiesten ene hizkuntza? Zeren ezin dezakezuen entzun ene hitza.

44 Zuek, debruaren umeak zarete; eta zuen aitaren nahikarien egitera zarete aiher. Hura gizon hiltzaile zen hastapenetik, eta ez du egian iraun, zeren egia ez baita haren baithan. Gezurrez mintzo denean, bere beretik mintzo da; ezen gezurtia da, eta gezurraren aita.

45 Nik berriz, erraten badut egia, ez nauzue sinhesten.

46 Nork zuetarik frogaturen darot bekhatu bat? Baldin egia erraten badarotzuet, zergatik ez nauzue sinhesten?

47 Jainkoaren ganikakoa denak, Jainkoaren hitzak entzuten ditu. Hargatik ez ditutzue zuek entzuten, etzaretelakoz Jainkoaren ganikakoak.

48 Horren gainean, Juduek ihardetsi eta erran zioten: Gure hitza ez othe da ongi

erran, Samariar bat zarela, eta debrua duzula zurekin?

49 Jesusek ihardetsi zuen: Ez da debrurik enekin; bainan ohore bihurtzen diot nik ene Aitari, eta zuek niri desohore.

50 Ni ordean ez nabila enetzat ospeketa; bainan bada dabilana eta juyatzen duena.

51 Egiazki derratzuet, egiazki, nork ere begiraturen baitu ene hitza, hainak ez du nihoiz-ere ikhusiren herioa.

52 Juduek erran zioten beraz: Orai ezagutzen dugu debrua duzula. Hil izan da Abraham, eta profetak ere-bai; eta diozu zuk: Norbaitek ene hitza begiratzen badu, harek ez du nihoiz heriotzea jasanen.

53 Ala gehiago zare *zu, ezenez Abraham* gure aita, zeina hil izan baita? Hil izan dire profetak ere. Nor egiten duzu zure burua?

54 Jesusek ihardetsi zuen: Ospe ematen badiot ene buruari, deusik ez da ene ospea: niri ospe ematen darotana, da ene Aita, zeina baiterrazue zuen Jainkoa dela,

55 Eta ez duzue ezagutu halere; nik bai ordean, ezagutzen dut. Eta erran baneza ez dudala ezagutzen, zuen iduriko ninteke, gezurti. Bainan ezagutzen dut, eta begiratzen dut haren hitza.

56 Abraham, zuen aita, lehiatu izan da ene egunaren ikhustera; ikhusi du, eta bozkariotan sarthu da.

57 Horren gainean, Juduek erran zioten: Ez dituzu oraino berrogoi eta hamar urthe,

eta zuk ikhusi baituzu
Abraham?
58 Jesusek ihardetsi
zaroeten: Egiazki derratzuet, egiazki; ni banaiz, Abraham izan den
baino lehenagodanik.
59 Orduan Juduek
hartu zituzten harriak,
Jesusi arthikitzeko;
bainan itzali zen Jesus,
eta ilkhi zen templotik.

## IX. KAP.

ETA iragaiten zelarik,
Jesusek ikhusi zuen
gizon bat, sortzetik
itsua.
2 Eta galdegin zioten
bere dizipuluek: Nausia, zeinek egin izan
dute bekhatu, horrek
ala horren burhasoek,
hola itsu sorthu baita?
3 Jesusek ihardetsi
zuen: Ez horrek, ez
horren burhasoek ez
dute bekhatu egin;
bainan hola da, horren
baithan ager ditezen
Jainkoaren lanak.
4 Ni bidali nauenaren lanak egin behar
ditut, egunak diraueno;
heldu da gaua, zeintan
nihor ez baititake lanean hari.
5 Munduan naizeno,
munduaren argia naiz.
6 Horiek erran ondoan, thu egin zuen lurrerat, eta ahogozoarekin
egin zuen lohi izpi bat
eta lohia hedatu itsuaren begien gainean.
7 Eta erran zioen:
Zoaz, garbi zaite Siloeko mainhatokian (Siloek erran nahi baitu
Bidalia). Goan zen
beraz, eta garbitu, eta
itzuli zen begiak argiturik.
8 Hargatik hauzoek,
eta lehenago eske ikhusi zutenek, erraten zuten: Ez othe da hau
jarririk eske zagoen
hura? Zioten batzuek:
Hura da.

9 Bertze batzuek ber-
riz : Ez, bainan haren
iduriko bat. Harek
zioen ordean : Ber-bera
naiz.
10 Galdatzen zaroeten
beraz : Nola ideki zaiz-
kitzu begiak ?
11 Ihardetsi zuen :
Jesus deitzen den gizon
harek egin izan du lohi
izpi bat, ferekatu ditu
ene begiak, eta erran
darot : Zoaz Siloeko
mainhatokira eta garbi
zaite. Eta goan naiz,
eta garbitu, eta ikhus-
ten dut.
12 Eta erran zioten :
Non da hura ? Ihar-
detsi zuen : Ez dakit.
13 Orduan Farisaue-
tara eraman zuten itsu
izatu gizona.
14 Larumbat eguna
zen bada, Jesusek lohia
egin eta itsuaren begiak
argitu zituenean.
15 Farisauak ere
huni galdeka hari zi-
*tzaizkon, hean* nola ar-
gitu zen. Harek aldiz
erran zioten : Lohi izpi
bat ezarri izan darot
begien gainean, eta gar-
bitu naiz, eta ikhusten
dut.
16 Erraten zuten be-
raz Farisauetarik ba-
tzuek : Ez da Jainko-
aren ganikakoa gizon
hura, larumbata ez due-
naz geroz begiratzen.
Zioten, berriz, bertze
batzuek : Gizon bekha-
tore batek nola egin
detzazke horrelako sen-
dagailak ? Eta eska-
tima zen hekien artean.
17 Berritan beraz er-
raten diote itsu izatu-
ari : Hik zer diok hire
begiak argitu dituenaz ?
Harek ihardetsi zioten :
Profeta dela.
18 Juduek ordean e-
tzuten sinhetsi, gizon
hori itsu izatua eta ge-
ro argitua izan zel
deithu zituzten ar
argitua izan zena
burhasoak ;

19 Eta hekiei galdatu zioten: Hau da zuen seme itsu sorthu dela diozuen hura? Nolaz bada ikhusten du orai?

20 Haren burhasoek ihardetsi eta erran zioten: Guk dakiguna da, hau gure semea dela, eta itsu dela sorthu;

21 Bainan nolaz duen ikhusten, hori ez dakigu, ez-etare nork ideki diozkien begiak; berari galdegiozue; adinak baditu, bera mintza bedi bere buruaz.

22 Horreletan mintzatu ziren haren burhasoak, Juduen beldur zirelakoz; alabainan Juduak hitzartuak ziren orduko, baizik-eta nihork aithor bihurtzen bazuen Jesus Kristo zela, haina sinagogatik kampo ezarria izanen zela.

23 Hargatik erran zuten ait-amek: Badu adina, berari galdegiozue.

24 Berriz deithu zuten beraz itsu izatu gizona, eta erran zioten: Aithor Jainkoari bihurrak; bazakiagu bekhatore bat dela gizon hura.

25 Ihardetsi zioten harek: Bekhatore bada ere, nik ez dakit; gauza bat dakit; itsu izan ondoan, orai ikhusten dudala.

26 Hekiek erran zioten: Zer egin darok? begiak nola ideki darozkik?

27 Ihardetsi zioten: Erran darotzuet oraikoz, eta aditu duzue: zertako nahi duzue berriz entzun? Ala zuek ere haren dizipulu jarri nahi zarete?

28 Orduan madarikatu zuten gizona, eta erran zioten: Hi, izan behedi haren dizipulu; gu, Moisesen dizipulu gaituk.

29 Bazakiagu Moisesi
mintzatu dela Jainkoa;
bainan hau, etzakiagu
nongo den.
30 Gizon harek ihar-
detsi eta erran zioten:
Hortaz da bada harri-
tzeko, zuek ez baitaki-
zue nondikakoa den,
eta harek niri begiak
ideki.
31 Bada, guk badaki-
gu ez dituela Jainkoak
gaichtaginak entzuten;
bainan norbait haren
zerbitzari bada, eta
haren nahia egiten ba-
du, entzuten du hura.
32 Egundaino ez da
aditu, norbaitek itsu
sorthuari begiak ideki
diozkiela.
33 Hura ez balitz
Jainkoa ganikakoa, ez
laiteke deuseren egite-
ko gai.
34 Hekiek ihardetsi
zioten eta erran: Be-
khatutan ithoa sortu
haiz, eta guri irakhatsi
*nahi darokuk?* Eta
kamporat eman
ten.
35 Aditu zuen Je
ek, kamporat eman
tela; eta bat-tu
nean, erran zioen: S
hesten duzu Jainkoa
Semearen baithan?
36 Ihardetsi eta er
zuen: Zein da h
Jauna, sinhets deza
haren baithan?
37 Eta Jesusek er
zioen: Ikhusi duzu
da, eta zurekin min
dena hura bera da.
38 Orduan gizo
erran zuen: Sinhes
dut, Jauna. Eta lu
rat eroriz adoratu zu
39 Eta Jesusek er
zioen: Zuzenari b
bidearen ematera n
mundu huntarat eth
ri, argiak itsu dite
eta itsuak argi.
40 Aditu zuten ha
kin ziren Farisau
tzuek eta erran ziot
Eta gu, itsuak o
gare?

41 Jesusek ihardetsi
zioten: Itsuak bazi-
nezte, bekhaturik etzin-
dukete. Diozue ordean
orai: Bai-eta ikhusten
baitugu. Zuen bekha-
tuak ere badirau.

## X. KAP.

EGIAZKI derratzuet,
egiazki: Ardite-
gian athetik sartzen ez
dena, bainan bertze
nombaitik igaiten,
haina ebasle eta ohoin
bat da.
2 Athetik sartzen de-
na ordean, hura da ar-
thaldeko artzaina.
3 Huni idekitzen dio
athezainak, eta ardiek
ezagutzen dute hunen
mintzoa, eta bere ardiak
deitzen ditu beren ize-
nez, eta alhara badara-
matza.
4 Eta ilkhiarazi ditue-
nean bere ardiak, ba-
doha hekien aitzinean,
eta jarraikitzen zaizko
ardiak, ezagutzen bai-
tute haren deya.
5 Ez darraizkio or-
dean arrotz bati; aitzi-
tik ihes egiten diote,
zeren ez baitute arro-
tzen mintzoa ezagutzen.
6 Jesusek idurikantza
hori atheratu zioten;
hekiek ordean etzuten
ezagutu zer erraten
zuen.
7 Jesusek beraz erran
zioten oraino ere: Egi-
azki, egiazki derratzuet
nik, ni naizela ardien
athea.
8 Ethorri izan diren
guziak oro ebasleak
ziren eta ohoinak, eta
ardiek ez dituzte en-
tzun izan.
9 Ni naiz athea.
Nitarik sartzen bada
norbait, salbaturen da;
sar-ilkhiak bere eskuko
izanen ditu, eta aur-
khituren du alhapide.
10 Ohoina ez da e-
thortzen, baizik-ere
ebastera, hiltzera eta

chahutzera: ni ethorri
naiz izan dezaten bizia
eta nasayago izan deza-
ten.
11 Ni naiz artzain
ona. Artzain onak
bere bizia ematen du
bere ardientzat.
12 Bainan saritako
gizonak, eta artzain ez
denak, zeinak ez baititu
ardiak bereak, ikhusten
du otsoa dathorla, eta
uzten ditu ardiak, eta
ihes badihoa; eta ot-
soak ardiak harrapatzen
eta barrayatzen ditu.
13 Bada saritako gi-
zona ihesari ematen da,
sarizale delakoz, eta
ardiez ez baitihoakio.
14 Ni naiz artzain
ona: eta ezagutzen di-
tut ene ardiak, eta ene-
ek ezagutzen naute,
15 Hala-nola ezagu-
tzen bainau ene Aitak,
eta nik ezagutzen baitut
ene Aita, eta ene ardien
gatik demat ene bizia.
*16 Baditut* bertze ardi
batzu ere, hespil hun-
takoak ez direnak; he-
kiek ere erakharri be-
har ditut; eta entzunen
dute ene mintzoa, eta
arthalde bakhar bat eta
artzain bakhar bat iza-
nen da.
17 Hargatik nau Ai-
tak maite; nik ematen
baitut ene bizia, gero
hartzeko berriz.
18 Nihork ez darot
khentzen; aitzitik nik
ematen dut ene olde-
tara; eta badut haren
uzteko ahala, eta badut
haren berriz hartzeko
ahala. Hori da ene
Aitaren ganik izatu
dudan manamendua.
19 Makhurra berriz-
ere Juduen artean a-
theratu zen solas horien
ariaz.
20 Zioten bada hekie-
tarik askok: Debrua
du, eta erhotua da; zer-
gatik entzuten duzue?
21 Bertzeek zioten:
Horiek ez dire bebru-

dunaren solasak; debruak itsuen begiak idek ahal othe detzazke ?

22 Bada, Dedikazioneko besta egiten zuten Jerusalemen, eta negua zen.

23 Eta Jesus temploan zabilan, Salomonen lorioan.

24 Juduak bildu ziren beraz haren ingurura, eta erran zioten: Noiz arteo idukiren ditutzu gure arimak gogoetaka? Baldin zu bazare Kristo, erraguzu garbiki.

25 Jesusek ihardetsi zioten: Mintzo natzaitzue, eta ez duzue sinkesten. Ene Aitaren izenean nik daramatzadan eginkariek berek nitaz lekhukotasun bihurtzen dute;

26 Zuek ordean ez duzue sinhesten, ez baitzarete ene ardietarik.

27 Ene ardiek entzuten dute en mintzoa; eta nik ezagutzen ditut hekiek, eta niri jarraikitzen dire;

28 Eta nik demotet bizitze bethierekoa; eta nihoiz ez dire galduko, eta nihork ez ditu ene eskutik eramanen.

29 Ene Aitak niri eman darotana, gauza guziak baino handiagoa da, eta nihork ez dezake ene Aitaren eskutik eraman.

30 Ni eta ene Aita, biak gauza bat gare.

31 Orduan Juduek harriak hartu zituzten Jesusen harrikatzeko.

32 Jesusek erran zioten: Ene Aitaren ganik dathortzen egintza on askoren lekhuko egin izan zaituztet; hekietarik zeinen ariaz nauzue harrikatzen ?

33 Juduek ihardetsi zioten: Ez ongi eginaren, bainan burhoaren ariaz harrikatzen zaitu-

gu; eta zeren, gizon bat zarelarik, zure burua Jainko egiten baituzu.

34 Jesusek ihardetsi zioten: Ezda iskribatua zuen legean: Nik erran dut: Jainkoak zarete?

35 Baldin Jainko deithu baditu hainak zeineri atheratu baitzayote Jainkoaren hitza, (eta Iskritura ezin urmariatuzkoa da);

36 Aitak saindu egin eta mundura bidali duenari nolaz derrozue: Burho arthiki duzu erran duzulakoz: Jainkoaren Semea naiz ni?

37 Baldin ez baditut ene Aitaren eginkariak egiten, ez ni sinhets.

38 Egiten baditut ordean, eta ez banauzue sinhetsi nahi, egintzak sinhetsatzue, ezagut dezazuen eta sinhets ene baithan dela Aita, *eta ni Aitaren* bathan.

*39 Hura hartu* beharrez zabiltzan beraz, bainan hekien eskuetarik atheratu zen.

40 Berriz-ere Jordanez haindira goan zen, Joanes lehenago bathayatzen haritu tokira, eta han egotu zen.

41 Eta jende asko goan ziren haren gana, eta erraten zuten: Joanesek hala badere ez du sendagailarik egin batere.

42 Joanesek ordean huntaz erran guzi-guziak egiak ziren. Eta hainitzek sinhetsi zuten Jesusen baithan.

## XI. KAP.

BAZEN, berriz, gizon bat eri, Lazaro deitzen zena, Bethaniakoa, Mariaren eta haren ahizpa Martharen herrikoa.

2 (Maria zen bada, Jaunaren gainera gantzugailua ichuri eta

haren oinak bere ileez
chukhatu izan zituen
emaztekia, eta haren
anaya Lazaro zen eri).
3 Haren arrebek igorri
zuten beraz Jesusi er-
ratera: Jauna, huna
zuk maite duzuna eri
dela.
4 Jesusek berriz, adi-
tzearekin erran zioten
mandatariei: Gaitz
hori ez da heriotzera-
koa, bainan Jainkoaren
ospagarri, eta horren
bidez gorets dadientzat
Jainkoaren Semea.
5 Bada, Jesusek maite
zituen Martha, haren
ahizpa Maria eta La-
zaro.
6 Eta aditu zuenaz
geroztik eri zela Lazaro,
bi egun egotu zen ha-
lere toki berean.
7 Gero hekien buruan,
erran zioten bere dizi-
puluei: Goazen berriz
Judeara.
8 Dizipuluek erraten
diote: Nausia, Juduak
orayetan zabiltzan zu
harrikatu beharrez, eta
oraino ere harat hari
zare ?
9 Jesusek ihardetsi
zioten: Egunak ez othe
ditu hamabi oren ? E-
gunaz dabilanak ez du
behaztoparik egiten,
zerenetaikbusten baitu
mundu huntako argia;
10 Gauaz badabila
ordean, behaztopatzen
da, argia ez delakoz
harekin.
11 Horiek erran zi-
tuen, eta horien ondoan
erran zuen berriz: Lo
datza Lazaro gure adis-
kidea, bainan banoha-
kio lotarik iratzartzera.
12 Dizipuluek ihar-
detsi zioten beraz: Lo
badago, osasunerako
da.
13 Haren heriotzeaz
mintzatu zen ordean
Jesus; hekiek aldiz,
uste izan zuten lo egi-
teaz zuela aiphu.
14 Orduan beraz Je-

susek garbiki erran zioten : Hil da Lazaro.

15 Eta zuen gatik atsegin dut ez bainintzen han, sinheste har dezazuen ; bainan goazen haren gana.

16 Tomasek beraz, Didimo deitzen zutenak, erran zioten dizipulu lagunei : Goazen gu ere, hil gaitezen hunekin.

17 Haletan ethorri zen Jesus, eta aurkhitu zuen Lazarok ordukoz lau egun bazituela hobian zela.

18 (Bada, Bethania Jerusalemetik hurbil zen, hamabortz estadiotan bezala.)

19 Baziren, berriz, Juduetarik asko, Marthari eta Mariari beren anayaren gaineko zerbait gozakari ematera ethorriak.

20 Marthak nabaritu zueneko beraz Jesus *hurbiltzen* hari zela, goan zen haren bidera ; aldiz Maria gelditu zen etchean.

21 Eta Marthak erran zioen Jesusi : Jauna, hemen izan bazine, etzen hilen ene anaya.

22 Bainan oraino ere badakit, ezen Jainkoari galdaturen diozkatzun guziak, Jainkoak emanen darozkitzula.

23 Jesusek ihardesten dio : Biztuko da zure anaya.

24 Bai, dio Marthak, badakit biztuko dela azken eguneko biztean.

25 Jesusek erran zioen : Ni naiz biztea eta bizitzea : ene baithan sinhesten duena, hila balitz ere, biziko da.

26 Eta bizi den eta ene baithan sinhesten duen edozein, ez da hilen behinere. Sinhesten duzu hori ?

27 Ihardetsi zioen : Bai, Jauna ; sinhesten

dut nik Kristo zarela,
Jainko biziaren Semea,
mundu huntara ethorri
zarena.
28 Horiek erran on-
doan, goan zen, eta ichi-
lik deithu zuen Maria,
bere ahizpa, zioelarik :
Nausia hemen da, eta
zure galdea du.
29 Aditu zueneko,
hura jaiki zen berehala,
eta goan zen Jesusen
gana ;
30 Ezik Jesus etzen
oraino herrira ethorria,
bainan Martha atheratu
zitzayoen toki berean
zen.
31 Mariarekin etchean
ziren Juduak, eta hari
gozakari ematen hari
zirenak, ohartu zirenean
nola batbatean jaiki eta
ilkhi zen, ondotik abiatu
zitzaizkon, zerratelarik :
Hobira doha, han nigar
egitera.
32 Bada, Maria heldu
izan zenean Jesus za-
goen tokira, hura ikhus-
tearekin oinetara erori
zitzayoen, eta erraten
dio : Jauna, hemen
izan bazine, etzen hilen
ene anaya.
33 Jesusek beraz i-
khusi zuenean nigarrez
eta harekin ethorri
Juduak ere nigarrez,
barnea laztu zitzayoen,
eta kantitu zen,
34 Eta erran zuen :
Non ezarri duzue ? I-
hardetsi zioten : Jauna,
zato eta ikhusazu.
35 Eta nigar egin
zuen Jesusek.
36 Horren gainean,
Juduek erran zuten :
Begira hola zuen
maite.
37 Aldiz hekietarik
zembaitek erran zuten :
Sortzetikako itsuaren
begiak ideki dituenak,
ez othe zezakeen bada
hau hiltzetik debeka ?
38 Jesus berriz-ere
bere baithan lazten ze-
larik, ethorri zen hobira.
Hura zen har-zilo bat,

eta lauza bat zuen gai-
netik.
39 Jesusek erran zu-
en : Khen zazue harria.
Jauna, dio Marthak,
hil zenaren arrebak,
usaindua da oraikoz,
ezen hau laugarren e-
guna da.
40 Jesusek ihardesten
dio : Ez othe darotzut
erran, ezen sinhestea
balimbaduzu, ikhusiren
duzula Jainkoaren in-
dar ospetsua ?
41 Khendu zuten be-
raz harria. Jesusek
berriz, begiak zerura
goitituz, erran zuen :
Aita, eskerrak darozki-
tzut bihurtzen, zeren
entzun bainauzu.
42 Nik bada bana-
kien, entzunen nau-
zula bethi ; bainan
mintzatu naiz inguruan
dagoen populu hunen
ariaz, sinhets dezaten
zuk bidalia naizela.
43 Horiek erran on-
*doan, gora egin* zuen
oihu : Lazaro, kampora
zato.
44 Eta berehala hila
ilkhi zen, oinak eta es-
kuak cherrendez lothu-
ak, eta hil oihala begi-
thartean : Jesusek er-
ran zuen : Khen dio-
zotzue lokharriak ; eta
bego goatera.
45 Hainitzek beraz,
Mariaren eta Martharen
gana ethorri, eta Je-
susek egina ikhusi
zuten Juduetarik, sin-
hetsi zuten haren bai-
than.
46 Bainan hekietarik
batzu Farisauetara go-
an ziren, eta erran zio-
ten zer egin zuen Je-
susek.
47 Aphez nausiek eta
Farisauek bildu zuten
beraz batzarra, eta zio-
ten : Zer hari gare,
ezen hainitz sendagail[a]
egiten du gizon horrek
48 Hola uzten bad
gu, guziek sinheste
manen diote ; eta eth

riko dire Erromarrak,
eta chahutuko dituzte
gure lekhua eta gure
jendakia.
49 Bada, hekietarik
Kaiphas deitzen zen
batek, nola urthe har-
takotzat aphez handi
baitzen, erran zuen:
Zuek deusik ez daki-
zue;
50 Eta etzaitzue bu-
ruratzen, egoki zaitzue-
la hil dadien gizon ba-
khar bat populuaren-
tzat, ezenez gal dadien
jendaki guzia.
51 Etzuen bada bere
baitharik erran hori;
bainan nola urthe har-
tako aphez handi bai-
tzen, profetisatu egin
zuen, Jesus hiltzekoa
zela jendakiarentzat,
52 Eta ez bakharrik
jendakiarentzat, bainan
oraino Jainkoaren ume
barrayatuak zirenen
batera biltzeko.
53 Egun hartaz ge-
roztik burutan hartu
zuten beraz hilarazi
behar zutela.
54 Hargatik Jesus
etzen gehiago ageriki
Juduen artean ibiltzen,
bainan mortu aldera
egin zuen, Efrem dei-
tzen den hirira, eta han
zagoen bere dizipulue-
kin.
55 Bada, hurbildua
zen Juduen Bazko, eta
aurkhintza hartarik
hainitzak Jerusalemera
igan ziren Bazko aitzi-
nean, beren buruen
garbitzera.
56 Bilhatzen zuten
beraz Jesus, eta tem-
ploan zaudelarik, zioten
elkharri: Zer zaitzue,
besta egun huntara ez
baita ethorri? Bada
aphez nausiek eta Fa-
risauek emana zuten
manua, norbaitek jaki-
ten bazuen non zen,
erran zezan, gero haren
hartzea gatik.

## XII. KAP.

BAZKORA sei egun, Jesus ethorri zen Bethaniara, non hil izan baitzen Lazaro, gero biztu zuena.

2 Han egin zioten afari bat; Martha hari zen zerbitzatzen; Lazaro berriz, Jesusekin mahainean zirenetarik bat zen.

3 Mariak aldiz, hartu zuen nardo hoberenetikako gantzugailu balios batetik libera bat; Jesusen oinak gantzutu zituen eta bere ileez chukhatu; eta gantzugailuaren usainaz bethe zen etchea.

4 Orduan dizipuluetarik batek, Judas Iskariot Jesus saldu behar zuenak erran zuen:

5 Zergatik gantzugailu hori ez da hirur ehun denariotan saldu, *eta beharrei* eman?

6 Bada, erran zuen hori, ez beharrez khechu zelakoz, bainan zeren ohoina baitzen, eta nola harek baitzuen moltsa, berak baitzerabilzkan hartan ezartzen zirenak.

7 Jesusek ihardetsi zuen beraz: Utzazue, ene ehortz eguneko begiratu baitu hau.

8 Alabainan bethi zuen artean izanen ditutzue beharrak, ni ordean ez nauzue izanen bethi.

9 Bada, Juduetarik oste handi batek jakin zuen han zela Jesus; eta ethorri ziren, ez-ezik haren ariaz, bainan ikhustea gatik Lazaro, hiletarik biztu zuena.

10 Aphez nausiek aldiz, burutan erabili zuten hilarazi behar zutela Lazaro ere,

11 Zeren Juduetar[illegible] hainitzek uzten bait[illegible] tuzten haren ariaz, e[illegible]

Jesusi sinheste ematen baitzioten.

12 Biharamunean berriz, bestara ethorriak ziren osteek aditu zutenean Jesus heldu zela Jerusalemera,

13 Palma adarrak hartu zituzten, eta bidera goan zitzaizkon, eta oihu egiten zuten: Hosanna, ongi-ethorri Israelgo erregeri, Jaunaren izenean dathorrenari.

14 Eta Jesusek aurkhitu zuen astokume bat, eta gainean jarri zitzayoen, iskribatua denaren arabera:

15 Ez izan beldurrik, Siongo alaba; huna zure erregea asto baten umearen gainean jarririk dathorla.

16 Dizipuluek etzuten lehembizian ezagutu gauza; bainan gero, noiz-ere Jesus sarthu izan baitzen bere ospean, orduan ohartu ziren horiek hartaz zirela iskribatuak, eta berak izatu zitzaizkiola egile.

17 Bada, Lazaro hobitik deithu eta hiletarik biztu zuenean Jesusek, harekin zen osteak lekhukotasun bihurtzen zuen.

18 Aria hortaz ere populua ethorri zitzayoen bidera, aditu baitzuten nola egin zuen sendagaila hori.

19 Farisauek erran zuten beraz elkharri: Ikhusten duzue ez dugula deusik atheratzen? horra ondotik dihoakiola mundu guzia.

20 Bada, besta eguneau adoratzera ethorri zirenetan baziren pagano zembait.

21 Hekiek beraz hurbildu zitzaizkon Filiperi, zeina Bethsaida Galileakoa baitzen, eta othoizten zuten, ziotelarik: Jauna, ikhusi nahi ginduke Jesus.

22 Badoha Filipe, eta

erraten dio Andresi;
Andresek berriz eta
Filipek erran zioten
Jesusi.
23 Jesusek aldiz hu-
nela ihardetsi zioten:
Ethorria da ordua,
zeintan goretsiko baita
gizonaren Semea.
24 Egiazki, egiazki
darotzuet erraten: ogi
bihia lurrerat erori on-
doan hiltzen ez bada,
bera dago bakharrik;
baldin ordean hil izan
bada, fruitu hainitz da-
khartzi.
25 Bere bizia duenak
maite, galduren du;
eta bere bizia mundu
huntan gaitzetsduenak,
bethiko bizitzerako du
begiratzen.
26 Baldin norbaitek
nahi banau zerbitzatu,
jarraik bekit, eta non
izanen bainaiz ni, ene
zerbitzaria ere han iza-
nen da. Baldin zerbi-
tzatzen banau norbai-
*tek, ohore hainari e-*
manen dio ene Ai-
tak.
27 Orai nahasia dago
ene arima. Eta zer
derraket? Aita, be-
gira nezazu ordu hun-
tarik. Bainan hunta-
kotzat, oren huntarako
naiz ethorria.
28 Aita, zure izenari
emozu ospe. Eta min-
tzo bat ethorri zen ze-
rutik: Eman diot, eta
emanen diot berriz-ere.
29 Han zagoen osteak
entzun zuen, eta zioen
ihurtzuria egin zela.
Bertze batzuek zioten:
Aingerua mintzatu zayo.
30 Jesusek ihardetsi
eta erran zioten: Ez
da ene gatik jautsi
mintzo hori, bainan bai
zuen ariaz.
31 Orai dihoa mun-
duaren juyamendua;
orai da iraiziren kam-
porat mundu hunen
buruzagia.
32 Eta nik, lurretil
goratua izanen naizean

oro bilduren ditut ene
gana.
33 (Zioen bada hori,
erakhustekotzat zer
heriotzez zen hil be-
harra).
34 Populuak ihardet-
si zioen: Gu entzunak
gare legetik, Kristok
bethi guzian duela i-
raunen; eta zuk, nolaz
diozu: Gizonaren Se-
mea behar da goititua
izan? Nor da gizona-
ren Seme hura?
35 Jesusek erran zio-
ten beraz: Aphur ba-
tentzat oraino zuekin
da argia. Ibil zaitezte
argia duzueno, etzai-
tzazten ilhumbeek har-
rapa. Ilhumbeka da-
bilanak, norat hari den
ez daki.
36 Argia duzueno,
izan zazue argian sin-
heste, argiaren ume
zaitezten izan. Horiek
erran zituen Jesusek,
eta goan, eta hekien
ganik gorde zen.
37 Bada, hekien ai-
tzinean hambateko sen-
dagailak egin zituen
arren, etzuten haren
baithan sinhesten,
38 Bethe zadientzat
Isaias profetak hunela
erran hitza: Jauna,
nork sinhetsi du guk
erantzun duguna, eta
norentzat izan da Jau-
naren besoa ageri?
39 Hargatik ezin sin-
hets zezaketen, Isaiasek
erran izan baitu oraino:
40 Itsutu ditu hekien
begiak eta gogortu he-
kien bihotza, ez deza-
tentzat begiz ikhus, ez
bihotzez adi; beldur-
rez eta itzul ditezen eta
senda detzadan.
41 Isaiasek erran ditu
horiek, ikhusi izan zue-
nean haren ospea, eta
hartaz mintzatu izan
denean.
42 Guzia gatik buru-
zagietarik ere hainitzek
sinhetsi zuten haren
baithan; bainan Fari-

sauen ariaz etzuten aithortzen, sinagogatik iraiziak ez izatea gatik;

43 Alabainan gogoanago izatu zuten gizonen arteko ospea, ezenez Jainkoarena.

44 Bada, Jesusek oihu egin eta erran izan zuen: Ene baithan sinhesten duenak, ez du ene baithan sinheste, bainan bai ni bidali nauenaren baithan;

45 Eta ni ikhusten nauenak, ni bidali nauena du ikhusten.

46 Ni, argia naiz mundu huntarat ethorri, ene baithan sinhesten duenik nihor ez dadien ilhumbeetan geldi.

47 Eta baldin norbaitek baditu ene hitzak eutzuten eta ez begiratzen, ezdut nik juyatzen hura. Ez naiz alabainan munduaren juya*tzera ethorri,* bainan bai munduaren salbatzera.

48 Ni arbuyatzen, eta ene hitzak onhesten ez dituenak badu nork juyaturen baitu. Nik ekharri dudan hitza, harek juyaturen du azken egunean.

49 Ezen ni, ez naiz ene burutarik mintzatu; bainan Aita, ni bidali nauenak, harek darot manatu zer erran eta zertaz mintza.

50 Eta badakit haren manamendua bethiereko bizitzea dela. Nik derratzadanak beraz, nola Aitak erran, halahala derrazkit.

XIII. KAP.

BAZKO besta egunaren aitzinean, Jesusek zakielarik ethorria zuela mundu huntarik Aitaren gana goteko ordua; nola ma izan baitzituen ber

munduan zirenak, azkeneraino izan zituen maite.

2 Eta afaldu zirenean, nola ordukoz debruak Judas, Simon Iskarioten semeari bihotzera eman baitzioen Jauna sal zezan;

3 Zakielarik Jesusek Aitak gauza guziak eskuetara eman zioizkiela, eta Jainkoaren ganik zela ilkhitzen, eta Jainkoaren gana zihoala;

4 Jaikitzen da mahainetik, eraunzten ditu soinekoak, hartzen du oihal bat, eta tinkatzen du gerrian.

5 Gero untzi batera ichurtzen du ura eta abiatzen da dizipuluen oinen garbitzen eta gerrian zuen oihalaz chukhatzen.

6 Heldu da beraz Simon Piarresen gana. Eta Piarresek erraten dio: Zer, Jauna, zuk niri oinak chahu?

7 Jesusek ihardesten dio eta erraten: Orai ez dakizu zer hari naizen; bainan geroago jakinen duzu.

8 Piarresek erraten dio: Egun-eta-iguzki ez darotadazu oinik garbituko. Ihardesten dio Jesusek: Ez bazaitut chahutzen, enekin ez duzu ikhustekorik izanen.

9 Simon Piarresek erraten dio: Jauna, ez-ezik oinak, bainan eskuak eta burua ere.

10 Chahutua denak, dio Jesusek, oinen garbitzea baizik ez du eskas, bertzenaz garbi da guzia. Zuek ere garbi zarete, bainan ez guziak.

11 Bazakien alabainan zein zen salduko zuena; hargatik ere erran zuen: Etzarete guziak garbi.

12 Beraz oinak chahutu eta soinekoak

hartu ondoan, berriz mahainean jarri zenean, erran zioten: Badakizue zer egin darotzuedan ?

13 Zuek deitzen nauzue Nausia eta Jauna, eta ongi mintzo zarete, ezen hala naiz ere.

14 Baldin beraz nik, Jaunak eta Nausiak, garbitu baditut zuen oinak, zuek ere batak bertzeari oinak garbitu behar diozkatzue.

15 Alabainan eman darotzuet irakhasbidea; nik nola, zuek ere egin dezazuen hala.

16 Egiazki derratzuet, egiazki: Sehia ez da nausia baino gehiago, ez-eta apostolua bidali duena baino.

17 Balimbadazkitzatzue horiek, dohatsu zareteke, baldin egiten badituztue.

18 Ez natzaitzue zuez guziez mintzo (badakit *ezen zein ditud*an hautatu), bainan Iskritura betho dadientzat: Ogia enekin jaten duenak, ene kontra du altchaturen hindagora.

19 Oraidanik darotzuet erraten, gertha dadien baino lehen, arren-eta egin daitekeenean, sinhets dezazuen nor naizen ni.

20 Egiazki, egiazki derratzuet nik: Norkere nik bidali dukedana baitu hartzen, ni neroni nau hartzen; berriz, ni hartzen nauenak, ni bidali nauena du hartzen.

21 Horiek erran ondoan, Jesusi kantitu zitzayoen tentua; mintzatu zen goraki eta erran zuen: Egiaz derratzuet egiaz, zuetarik batek salduko nauela.

22 Dizipuluak beraz elkharri begira zauden, ez jakinez zeintaz oth zen mintzo.

23 Bada, dizipulueta

rik bat, Jesusek maite
zuena, etzana zagoen
Jesusen bulharren gai-
nera.
24 Simon Piarresek
kheinu egin zioen be-
raz, eta erran zioen:
Zeintaz da mintzo?
25 Hargatik, Jesusen
bulharren gainera ma-
khurturik, dizipulu ha-
rek erraten dio: Nor
da, Jauna?
26 Jesusek ihardetsi
zuen: Haina zeinari ogi
bustia eskainiko baitiot.
Eta ogia bustirik, Ju-
das Iskarioti, Simonen
semeari, eman zioen.
27 Eta ahamenaren
ondotik, Satan sarthu
zitzayoen barnera. Eta
Jesusek erran zioen:
Egiten hari duzuna, le-
hen-bai-lehen egizu.
28 Bainan mahainean
zirenetarik nihork et-
zuen ezagutu zertako
erran zioen hori.
29 Ezik, Judasek zue-
lakoz moltsa, batzuek
uste izan zuten Jesusek
erraten zioela: Besta
eguneko behar ditugu-
nak erosatzu; edo jende
beharrei zerbait eman
ziozoten.
30 Pochia hartu-eta,
Judas ilkhi zen bere-
hala. Bada, gaua zen
ordukoz.
31 Ilkhi zenean be-
raz, Jesusek erran zu-
en: Orantche goretsia
da gizonaren Semea,
eta Jainkoa goretsia da
haren baithan.
32 Baldin haren bai-
than goretsia bada Jain-
koa, Jainkoak ere bere
baithan goretsiko du
hura; eta laster goret-
siko du.
33 Haurttoak, aphur
bat naiz oraino zuekin;
bilhatuko nauzue, eta
Juduei erran izan dio-
tedan bezala: Ni no-
han tokira zuek ezin
ethor zaitezkete; zuei
ere halaber derratzuet
orai.

34 Ematen darotzuet manamendu berri bat: Elkhar maitha dezazuen; nik maite izan zaituztedan bezala, zuek ere maitha dezazuen elkhar.

35 Hortan ezagutuko dute guziek ene dizipuluak zaretela, maitetasunik balimbaduzue elkharrentzat.

36 Simon Piarresek erraten dio: Norat zoaz, Jauna? Jesusek ihardesten du: Ni nohan tokira, zu ezin jarraik zakizket orai; bainan geroago jarraikiko zare.

37 Zertako, dio Piarresek, ezin jarraik nakikezu orai? Zuretzat emanen dut ene bizia.

38 Jesusek ihardesten dio: Enetzat emanen duzu zure bizia? Egiazki, egiazki derratzut nik, oilarrak ez du joko, non ez nauzun hi*ruretan ukhatu.*

## XIV. KAP.

EZ bedi nahas zuen bihotza. Jainkoaren baithan sinhesten duzue, sinhetsazue ene baithan ere.

2 Asko egon-lekhu dire ene Aitaren etchean. Hala ez balitz, erran narokezuen, ezen banoha zuei tokiaren aphaintzera.

3 Eta goan naitekeenean eta tokia aphaindu darotzuedan ondoan, berriz banathor, eta hartuko zaituztet ene gana, ni naizen tokian izan zaitezten zuek ere.

4 Eta nora nohan badakizue, eta badakizue bidea.

5 Tomasek erraten dio: Jauna, ez dakigu nora zoazen: eta nola dakikegu bidea?

6 Jesusek ihardeste
dio: Ni naiz bide
eta egia, eta bizia;
hor ez da Aitaren

nat ethortzen, baizik-
ere ene bidez.
7 Ezagutzen banindu-
zue, ezagut zinezakete
ene Aita ere; eta eza-
gutuko duzue laster, eta
ikhusi duzue.
8 Filipek erraten dio:
Jauna, erakhuts diza-
guzu Aita, eta aski
zaiku.
9 Jesusek ihardesten
dio: Hain aspaldian
zuekin naiz, eta ez nau-
zue ezagutzen bada?
Filipe, ni ikhusten
nauenak, ikhusten du
Aita ere. Nolaz diozu
beraz: Erakhuts diza-
guzu Aita?
10 Ez duzue sinhesten
ni Aitaren baithan nai-
zela, eta Aita ene bai-
than? Nik erraten
darozkitzuedan solasak,
ez derrazkitzuet ene
burutarik. Bainan ene
baithan dagoen Aitak,
berak egiten ditu gau-
zak.
11 Ez duzue sinhesten
ni Aitaren baithan nai-
zela, eta Aita ene bai-
than?
12 Egintzen ariaz be-
deren sinhetsazue. E-
giazki derratzuet, egi-
azki: Ene baithan sin-
hesten duenak, nik
egiten ditudan eginka-
riak eginen ditu hark
ere, eta haukiek baino
handiagorik eginen du;
alabainan ni Aitaren
gana banoha.
13 Eta edozein gauza
Aitari galda diozozuen
ene izenean, eginen dut
hura, Aita goretsia izan
dadien Semearen bai-
than.
14 Zerbait eskatzen
badarotadazue ene ize-
nean, eginen dut hura.
15 Ni maite balimba-
nauzue, ene manamen-
duak begira zatzue.
16 Eta nik othoizturen
dut Aita, eta bidaliren
darotzue, zuekin dago-
entzat bethi guzian,
bertze Sosegatzaile bat,

17 Izpiritu egiazkoa, munduak ezin izan dezakeena, zeren ez baitu ez ikhusten ez ezagutzen. Zuek ordean ezagutuko duzue, zuekin egonen eta zuetan izanen baita.

18 Etzaituztet utziko umezurtz; ethorriko naiz zuen gana.

19 Oraino aphur bat, eta ez nau gehiago ikhusiko munduak. Bainan zuek, ikhusiko nauzue, zeren ni bizi bainaiz, eta zuek ere biziko baitzarete.

20 Egun hartan ezagutuko duzue, ni ene Aitaren baithan naizela, eta zuek ene baithan, eta ni zuen baithan.

21 Nork-ere ene manamenduak izan, eta begiratzen baititu, hura da ni maite nauena. Bada, ni maite nauena, *ene Aitaz maithatua izanen da, eta maite* izanen dut nik ere, eta hari agertuko diot ene burua.

22 Erraten dio Judasek, ez Iskariot deitzen zen harek : Jauna, zer aria da, guri agertuko baituzu zure burua, eta munduari ez ?

23 Jesusek ihardetsi eta erran zioen : Norbaitek maite balimbanau, begiratuko du ene hitza ; ene Aitak ere maithatuko du hura, eta haren gana ethorriko gare, eta haren baithan eginen dugu gure egoitza.

24 Ni maite ez nauenak ez ditu ene hitzak begiratzen ; eta entzun duzuen hitza ez da enea, bainan bai ni bidali nauen Aitarena.

25 Haukiek erran darozkitzuet zuekin naizelarik.

26 Sosegatzaileak ordean, Izpiritu sainduak, zeina ene izenean igor-

hariren baitu Aitak, harek irakhatsiren darozkitzue guziak, eta orhoitaraziren zaituztete nik erran darozkitzuedan guziez.

27 Uzten darotzuet bakea, ematen darotzuet ene bakea; nik ematen darotzuet, ez munduak deman arara. Zuen bihotza ez bedi ez nahas ez ikhara.

28 Aditu duzue nola erran darotzuedan: Banoha, eta heldu natzaitzue. Maite baninduzue, bai bozkariotan sar zintezkete, zeren Aitaren gana nohan, Aita ni baino handiagoa baita.

29 Eta orai darotzuet erraten, gertha dadien baino lehen, gerthatu ditekeenean, eman dezazuen sinheste.

30 Ez naiz gaurgeroz zuekin hambat mintzatuko; ezik heldu da *mundu hunen* buruzagia, nahiz ez duen ene gainean ikhustekorik batere.

31 Bainan hola da, ezagut dezan munduak, nik maite dudala Aita, eta nola niri Aitak manatu, hala egiten dudala. Jaiki zaitezte, goazen hemendik.

## XV. KAP.

NI naiz aihen egiazkoa, eta ene Aita mahastizaina da.

2 Nitan fruiturik ez dakharten adar guziak khenduko ditu, eta fruitu ekhartzen dutenak oro chederratuko ditu, ekhar dezaten gehiago oraino.

3 Zuek jadanik garbi zarete, nik zuei erran izan darotzuedan solasaren ariaz.

4 Zaudezte nitan, eta ni zuetan. Nola adarrak fruiturik ezin eman baitezake, non ez

dagoen aihenaren gai-
nean; ezeta zuek ere,
non etzareten nitan
egoten.
5 Ni naiz aihena,
zuek adarrak: zeinere
baitago nitan, eta ni
hartan, hainak ekharri-
ren du fruitu hainitz;
ezen ni gabe, ezin egin
dezakezue deusere.
6 Nitan ez dagoena,
kamporat arthikia iza-
nen da adar ezdeusa
bezala, eta ihartuko da,
eta bilduko dute gero,
eta surat arthikiko;
eta erreko da.
7 Baldin nitan egoten
bazarete, eta ene hitzak
zuetan badaudezi, edo-
zein gauza nahi izan
dezazuen, galdatuko
duzue, eta egina izanen
zaitzue.
8 Huntan goresten
da ene Aita, fruitu hai-
nitz ekhar dezazuen,
eta egin zaitezten ene
dizipulu.
*9 Aitak ni* maithatu
nauen bezala, nik ere
zuek zaituztet maitha-
tu. Zaudezte ene on-
hesgoan.
10 Baldin ene mana-
menduak begiratzen
badititutzue, ene onhes-
goan egonen zarete,
hala-nola nik ere ene
Aitaren manamenduak
begiratu baititut, eta
haren onhesgoan bai-
nago.
11 Horiek erran da-
rozkitzuet, ene bozka-
rioa zuetan egon, eta
zuena bethea izan da-
dien.
12 Hau da ene mana-
mendua, elkhar maitha
dezazuen, nik maite
izan zaituztedan be-
zala.
13 Nihork ez dezake
erakhuts amodio han-
diagorik, nola bere bizia
bere adiskideentzat e-
matean.
14 Zuek ene adiski-
deak zarete, baldin nik
manatzen darozkitzue-

danak egiten baditutzue.

15 Etzaituztet gaurgeroz zerbitzariak deithuko, zeren ez baitaki zerbitzariak zer hari den haren nausia. Deithu zaituztet ordean adiskideak, zeren ene Aitaren ganik entzun ditudanez jakintsun egin baitzaituztet guziez.

16 Zuek ez nauzue ni hautatu, bainan nik zuek hautatu zaituztet; eta ezarri zaituztet, goan zaitezten, eta fruitu ekhar dezazuen, eta zuen fruituak iraun dezan; ene Aitak eman dezazuen, ene izenean galdatuko duzuen edozein gauza.

17 Nik manatzen darotzuedana da, elkhar maitha dezazuen.

18 Gaitzesten bazaituzte munduak, jakizue ni zuek baino lehen gaitzetsi nauela.

19 Mundutikakoak bazinete, munduak berea maitha lezake; zeren ordean etzareten mundutikakoak, bainan nik mundutik hautatu zaituztedan, hargatik gaitzets zaituzte munduak.

20 Orhoit bekizue nik zuei erran hitza: Sehia ez da nausia baino gehiago. Jazarri badarotet niri, jazarriren darotzuete zuei ere; begiratu badute ene hitza, zuena ere begiraturen dute.

21 Bainan gaizki horiek oro eginen darozkitzuete ene izenaren ariaz, zeren ni igorri nauena ez baitute ezagutzen.

22 Baldin ethorri izan ez banintz eta ez banintzayote mintzatu, hobenik etzuketen; bainan orai beren hobenarentzat aitzakiarik ez dute.

23 Ni higuin nauenak, higuin du ene Aita ere.

24 Baldin hekien erdian egin ez banitu bertze nihork egin ez dituen eginkariak, bekhaturik etzuketen; bainan orai, eta ikhusi dute, eta higuin gaituzte bai ni eta bai ene Aita,

25 Bainan hori izatu da, bethe zadientzat hekien legean iskribatua den hitza: Ariarik gabe izan naute higuintzetan,

26 Ordean, noiz-ere ethorriko baita nik Aitaren ganik bidaliko dudan Sosegatzailea, egiazko izpiritua, Aitaren ganik iraulgitzen dena, harek bihurturen du lekhukotasun nitaz.

27 Zuek ere lekhukotasun bihurturen duzue, zeren hastetik enekin baitzarete.

XVI. KAP.

ERRAN darozkitzuet horiek, gaizbidetan etzaitezten eror.

2 Sinagogetarik khenduko zaituztete, eta heldu da ordua, non edozeinek hil zaitzazten, usteko baitu Jainkoari gogara egiten dioela.

3 Eta horiek eginen darozkitzuete, zeren ez baikaituzte ezagutzen ez Aita, ez ni.

4 Bada, haukiek erraten darozkitzuet, orhoit zaitezten ordua ethorri ditekeenean, nola erran izan darozkitzuetan.

5 Hastetik ordean ez darozkitzuet erran, zeren zuekin bainintzen. Eta orai banoha bidali nauenaren gana, eta batek-ere zuetarik ez darot galdegiten: Nora zoaz?

6 Bainan erran darozkitzuedalakoz, ilhun-

durak bethe du zuen bihotza.

7 Bizkitartean egia derratzuet: zuen ona da goan nadien; ezen goan ez banindedi, Sosegatzailea ez litzaitzueke ethor; aldiz balimbanoha, igorriko dut zuen gana.

8 Eta ethorri ditekeenean, mundua agerraraziko du hobendun bekhatuaz, zuzembideaz eta juyamenduaz;

9 Bekhatuaz behin, zeren ez duten ene baithan sinhetsi;

10 Zuzembideaz aldiz, zeren ene Aitaren gana bainoha, eta ez bainauzue gehiago ikhusiren;

11 Juyamenduaz gero, zeren juyatua baita jadanik mundu huntako buruzagia.

12 Oraino baditut bertze asko zuei errateko, bainan etzarete orai egartzeko gai.

13 Noiz-ere ordean ethorriren baita egiazko Izpiritu hura, irakhatsiren darotzue egia guzia; ez da ezen bere baitharik mintzaturen, bainan zer-ere entzun baituke, hura erranen du, eta ethorkizuneko gauzez argituren zaituzte.

14 Harek nau goretsiren, zeren enetik hartuko baitu, eta ezagutaraziko baitarotzue.

15 Aitak dituenak oro eneak dire. Hargatik erran darotzuet: Enetik hartuko du eta zuei ezagutaraziko darotzue.

16 Oraino aphur bat, eta ez nauzue gehiago ikhusiren, eta berriz bertze aphur bat, eta ikhusiko nauzue, zeren Aitaren gana bainoha.

17 Dizipuluetarik batzuek erran zuten beraz elkharren artean: Zer othe da guri derragun

hau : Oraino aphur bat, eta ez nauzue ikhusiko; eta berriz bertze aphur bat, eta ikhusiko nauzue, zeren Aitaren gana bainoha ?

18 Zioten beraz : Zer da aiphatzen duen Aphurra ? Ez dakigu zertaz den mintzo.

19 Bada, Jesusek ezagutu zuen, galdeka abiatu nahi zitzaizkola, eta erran zioten : Zuen artean hortaz bilhatzen zarete, zeren erran baitarotzuet : Oraino aphur bat eta ez nauzue ikhusiko; eta berriz bertze aphur bat, eta, ikhusiren nauzue.

20 Egiazki, egiazki derratzuet nik : Zuek auhen eta nigar eginen duzue, eta mundua boztuko da; zuek aldiz atsekabetuko zarete, bainan zuen atsekabea bozkariotara bihurtuko da.

21 Emazteki batek erditzean atsekabe du, zeren ethorria baita haren ordua ; bainan seme batez erdi denean, ez da orduan bere hesturaz orhoitzen bozkarioaren ariaz, zeren gizon bat mundura sorthu baita.

22 Zuek ere beraz orai atsekabetan zarete, hala da ; bainan ikhusiren zaituztet berriz, eta bozturen da zuen bihotza, eta zuen baitharik nihork ez du khenduko zuen bozkarioa.

23 Eta egun hartan deusetaz etzarozkidate galdeka hariko. Egiaz derratzuet egiaz, baldin zerbait galdegiten badiozue Aitari ene izenean, emanen darotzue.

24 Orai arteo deus ez duzue galdegin ene izenean ; galda zazue, eta izanen duzue, zuen bozkarioa izan daiend bethea.

25 Haukiek iduripenetan erran darozkitzuet. Heldu da ordua, non ez bainatzaitzue gehiago iduripenetan mintzatuko, bainan ene Aitaz garbiki eginen baitarotzuet solas.

26 Egun hartan ene izenean galdeginen duzue, eta nik ez darotzuet erraten zuentzat othoizturen dudala Aita;

27 Alabainan Aitak berak maite zaituzte, zeren zuek maithatu bainauzue, eta sinhetsi baituzue ni Jainkoaren ganik ilkhi naizela.

28 Aitaren ganik ilkhi naiz, eta mundurat ethorri; berriz uzten dut mundua, eta Aitaren gana banoha.

29 Dizipuluek erraten diote: Huna, orai garbiki mintzo zare, eta zure solasetan ez da itchurapenik batere.

30 Orai ikhusten dugu gauza orotaz jakintsun zarela, eta beharrik ez duzula nihor hari dakizun galdeka: horren gatik sinhesten dugu Jainkoaren ganik ilkhia zarela.

31 Jesusek ihardesten diote: Sinhesten duzue orai?

32 Huna, heldu da ordua, eta jadanik ethorria da, non barrayatuak izanen baitzarete zein zuen alde, eta bakharrik utziko bainauzue. Ez naiz bada bakharrik, ezen Aita enekin da.

33 Horiek erran darozkitzuet, bakea izan dezazuen ene baithan. Munduan izanen duzue hestura; bainan zaudezte gogoak sendorik, nik garhaitu dut mundua.

## XVII. KAP.

JESUSEK hitz horiek egin zituen, eta begiak zerura goitituriik, erran zuen: Aita, ethorri da ordua; goretsazu zure Semea, gorets zaitzan zure Semeak ere;

2 Gizon guzien gainean esku eman diozun bezala, berak eman diozoten bethiereko bizitzea zuk haren eskuan ezarri ditutzun guziei.

3 Hau da bada bethiereko bizitzea: Ezagutzea zu, egiazko Jainko bakharra, eta Jesu-Kristo zuk bidali izan duzuna.

4 Nik lurraren gainean goretsi zaitut; akhabatu dut zuk egitera eman izan darotazun lana.

5 Eta orai, Aita, zure baithan gorets nezazu, *nik,* mundua sorthu *baino lehen,* zure baithan izatu dudan ospeaz.

6 Zure izena ezagutarazi dut niri mundutik eman darozkidatzun gizonen aitzinean. Zureak ziren, eta eman izan daroztadatzu, eta begiratu dute zure hitza.

7 Orai ezagutu dute, zuk niri eman gauza guziak zure ganik heldu direla;

8 Zeren zuk niri eman hitzak eman baitiozkatet haukiei; eta onhetsi dituzte berek, eta zin-zinez ezagutu dute zure ganik ilkhi naizela, eta sinhetsi dute zuk bidali nauzula.

9 Ni haukientzat nagotzu othoitzez; ez darotzut othoitz egiten munduarentzat, bainan bai niri eman izan daroztadatzunentzat, zureak direlakoz.

10 Eta eneak dir gauza guziak, zure

dire; eta zureak, eneak
dire, eta hekietan naiz
goretsia.
11 Ez naiz ja gehiago
munduan, eta haukiek
munduan dire, eta ni
zure ganat heldu naiz.
Aita saindua, zure ize-
nean zain zatzu niri
eman izan daroztada-
tzunak, izan ditezen
guziak bat, zu eta ni
garen bezala.
12 Haukiekin nintze-
no, begiratzen nituen
zure izenean. Zaindu
ditut eman daroztada-
tzunak; eta haukieta-
rik nihor ez da galdu,
galdu behar zena baizik,
bethe zadien Iskritura.
13 Orai bada, zure
ganat heldu naiz, eta
hunela mintzo natza-
yote munduan, beren
baithan izan dezaten
ene bozkarioaren be-
thetasuna.
14 Eman diotet zure
hitza, eta gaitzetsi ditu
munduak, zeren ez bai-
tire mundutikakoak,
hala-nola ez bainaiz ni
ere mundutikakoa.
15 Etzaitut othoizten
eraman detzatzun mun-
dutik, bainan begira
detzatzun gaizkitik.
16 Ez dire mundu-
tikakoak, ni ere mun-
dutikakoa ez naizen
bezala.
17 Egian egin zatzu
saindu. Zure hitza egia
bera da.
18 Zuk ni mundura
igorri nauzun bezala,
nik ere haukiek mun-
dura igorri ditut.
19 Eta nik haukien
gatik saindu egiten dut
ene burua, haukiek ere
egian izan ditezen sain-
du eginak.
20 Eta ez-ezik hau-
kientzat egiten daro-
tzut othoitz, bainan o-
raino haukien hitzaren
bidez ene baithan sin-
hetsiko dutenentzat:
21 Guziak bat izan
ditezen, hala-nola, Aita,

zu ene baithan, eta ni
zure baithan, haukiek
ere bat izan ditezen
gure; sinhets dezan
munduak zuk bidali
nauzula.
22 Eta zuk niri eman
ospea, nik ere eman
diotet haukiei, bat izan
ditezen, gu bat garen
bezala.
23 Ni haukietan naiz,
eta zu ene baithan, bat-
tasunean izan ditezen
urthuak, eta ezagut
dezan munduak zuk
bidali nauzula, eta mai-
thatu ditutzula, ni mai-
thatu nauzun bezala.
24 Aita, nahi dut izan
ditezen enekin ni iza-
ten naizen tokian, niri
eman daroztadatzunak
ere, ikhus dezaten ene
ospea, zuk niri emana,
maithatu nauzulakoz
mundua egina izan den
baino lehenagodanik.
25 Aita zuzena, mun-
*duak etzaitu* ezagutu;
*nik* *ordean* ezagutu
zaitut, eta haukiek ere
ezagutu dute zuk nau-
zula bidali.
26 Eta ezagutarazi,
eta ezagutaraziren dio-
tet zure izena; haukien
baithan izan dadien a-
modioa zeintaz ni mai-
thatu bainauzu, eta ni
ere haukien baithan.

## XVIII. KAP.

HORIEK erran on-
doan, Jesus bere
dizipuluekin atheratu
zen Zedrongo errekaz
haindira, han baitzen
baratze bat, eta hartan
sarthu zen, eta dizipu-
luak ere-bai.
2 Bada, Judasek ere,
zeinak saltzen baitzuen,
ezagutzen zuen tokia,
zeren maiz harat bildu
izan baitzen Jesus bere
dizipuluekin.
3 Beraz, harturik sol-
dado andana bat eta
aphez nausien eta Fari-
sauen ganik muthil
batzu, Judas harat e-

thorri zen lanternekin, zuziekin eta harmekin.

4 Hargatik, Jesusek baitzakizkien bere gainean gerthatu behar zitzaizkon guziak, aitzinatu zen eta erran zioten: Nor bilhatzen duzue?

5 Ihardetsi zioten: Jesus Nazaretharra. Jesusek erraten diote: Ni naiz. Bada, Judas haren saltzailea ere han zen hekiekin.

6 Beraz Jesusek erran orduko: Ni naiz, gibelka goan eta lurrerat erori ziren.

7 Bigarrenean galdatu zioten beraz: Nor bilhatzen duzue? Hekiek aldiz erran zuten: Jesus Nazaretharra.

8 Jesusek ihardesten diote: Erran darotzuet ni naizela; baldin beraz ene ondoan bazabiltzate, uzkitzue haukiek goatera.

9 Bethe zadien erran zuen hitza: Eman daroztadatzunetarik ez dut batere galdu.

10 Orduan Simon Piarresek, ezpata bat baitzuen, hura atheratu eta aphez handiaren muthil bat jo zuen, eta moztu zioen eskuineko beharria. Eta muthil hura Malko deitzen zen.

11 Bainan Jesusek erran zioen Piarresi: Emazu zure ezpata maginan. Ala Aitak niri eman kalitza ez othe dut edanen?

12 Soldadoek beraz, eta hekien aitzindariak eta aphez handiaren muthilek hartu zuten Jesus eta estekatu;

13 Eta eraman zuten lehenik Anasen aitzinera, ezen Kaiphasen aitaginarreba zen hura, eta Kaiphas zen urthe hartakotzat aphez handi.

14 Hura zen bada Juduei kontseilu han eman ziotena: Mengoa da gizon bakhar bat hil dadien populuarentzat.

15 Simon Piarres berriz, eta bertze dizipulu bat ere jarraikitzen zitzaizkon Jesusi. Dizipulu hura aldiz, aphez handiaren ezaguna zen, eta Jesusekin sarthu zen aphez handiaren ezkaratzean.

16 Piarres berriz, athearen kampoko aldean zagoen chutik. Ilkhi zen beraz bertze dizipulu, aphez handiaren ezagun hura, eta neskato athalzainari erranik, sarrarazi zuen Piarres.

17 Neskato athalzainak erraten dio Piarresi: Zu ere etzare gizon horren dizipuluetarik? Harek ihardesten dio: Ez naiz



18 Bada, sehiak eta soldadoak suaren aitzinean zauden, hotz zelakoz, eta berotzen hari ziren; berriz, Piarres ere hekiekin zen, eta berotzen zagoen.

19 Bizkitartean aphez handia Jesusi galdeka hasi zitzayoen bere dizipuluen eta irakhasmenaren gainean.

20 Jesusek ihardetsi zioen: Ni agerian mintzatu natzayo jendeari; sinagogan eta temploan, Juduak biltzen diren tokian irakhatsi izan dut, eta ez dut gordeka deusik erran.

21 Zertako hari zakizkit galdatzen? Entzun dutenei galdegiozute zer erran diotedan; hara hekiek badakite nola mintzatu naizen ni.

22 Hitz horiek atheratu orduko, hekiekin ziren sehietarik batek

mazelako bat eman
zioen Jesusi, zerralarik:
Horrela ihardesten diok
aphez handiari ?
23 Jesusek ihardetsi
zioen : Gaizki mintzatu
banaiz, erakhutsazu er-
ran izan dudan gaizkia;
aldiz ongi mintzatu ba-
naiz, zergatik jotzen
nauzu ?
24 Eta Anasek este-
katua igorri zuen Kai-
phas aphez handiaren
aitzinera.
25 Bizkitartean Si-
mon Piarrez chutik za-
goen eta berotzen. Er-
ran zioten beraz: Zu
ere etzare horren dizi-
puluetarik ? Ukhatu
zuen harek eta erran:
Ez naiz hala.
26 Aphez handiaren
sehietarik, Piarresek
beharria moztu zioena-
ren ahaide zen batek,
erraten dio: Nik ez
othe zaitut horrekin
baratzean ikhusi ?
27 Berriz-ere ukhatu
zuen Piarresek, eta oi-
larrak jo zuen berehala.
28 Baderamate beraz
Jesus Kaiphasen ganik
gobernadorearen jau-
regira. Goiza zen or-
duko; eta berak etzi-
ren jauregian sarthu,
ez khutsatzea gatik,
Bazkoaren jateko a-
riaz.
29 Pilato kamporat
ilkhi zen beraz hekie-
tara, eta erran zioten:
Zer hoben ekhartzen
duzue gizon hunen
kontra ?
30 Ihardetsi eta erran
zioten : Gaichtagin bat
izan ez balitz, ez ahal
ginarotzun eskuetara
emanen.
31 Pilatok erran zio-
ten beraz: Har zazue
zuek, eta juya zazue
zuen legearen arabera.
Juduek horren gainean
ihardetsi zioten: Guri
etzaiku haizu nihoren
hiltzea.
32 Bethe zadien Je-

susek erran hitza, erakhustera eman zuenean zer heriotzez zen hil behar.

33 Pilato berriz sarthu zen beraz jauregira, deithu zuen Jesus eta erran zioen: Zu zare Juduen errege ?

34 Jesusek ihardetsi zioen: Zure baitharik diozu hori, ala bertzeek erran darotzute nitaz ?

35 Pilatok ihardetsi zuen: Judua othe naiz ni? Zure jendakiak eta aphez handiek ezarri zaituzte ene eskuetan: zer egin duzu ?

36 Jesusek ihardetsi zuen: Ene erresuma ez da mundu huntarikakoa; baldin mundu huntarikakoa izan balitz ene erresuma, ene azpikoak gudukatu zitezkeen segurki, ni Juduen eskuetara ez uzteko; bainan ene erresuma ez da hemendikakoa.

*37 Hargatik Pilatok* erran zioen: Beraz errege zare zu ? Jesusek ihardetsi zuen: Zuk diozuna, hala naiz. Hortako naiz sorthu eta hortara naiz mundurat ethorri, lekhukotasun bihur diozodan egiari; egiatik dathortzen guziek entzuten dute ene mintzoa.

38 Pilatok erraten dio: Zer da egia ? Eta hori erran ondoan, berriz ilkhitzen da Juduetara, eta erraten diote: Nik ez dut gizon hunen baithan lophiderik batere aurkhitzen.

39 Bainan nola aztura baita, Bazkoz utz dezazuedan norbait; nahi duzue bada eman dezazuedan Juduen errege?

40 Eta berriz abiatu ziren guziak oihuka, ziotelarik: Ez hori, bainan Barrabas bai. Bada, ohoin bat zen Barrabas.

## XIX. KAP.

ORDUAN beraz Pi-
latok hartu zuen
Jesus, eta azotarazi
zuen.
2 Eta soldadoek el-
horrizko khoro bat bi-
hurturik, ezarri zioten
buruan, eta purpurazko
soin batez inguratu zu-
ten bera.
3 Eta bazihoazkion,
eta erraten zuten: A-
gur, Juduen errege, eta
beharrondokoka hari
zitzaikon.
4 Pilato berriz-ere il-
khi zen beraz kampo-
rat, eta erraten diote
Juduei: Huna non
erakhartzen darotzue-
dan kamporat, jakin
dezazuen ez dudala
hunen baithan niho-
lazko lophiderik aur-
khitzen.
5 Jesus atheratu zen
beraz elhorrizko kho-
roarekin eta purpuraz-
ko soinaz jauntzia, eta
Pilatok erraten diote:
Huna gizona.
6 Eta, ikhusi zutene-
ko, aphez nausiak eta
hekien gizonak izko-
laka hasi ziren, ziotela-
rik: Gurutzefika zazu,
gurutzefika. Pilatok
erraten diote: Har
zazue zuek, eta guru-
tzefika zazue, ezen nik
ez diot ariarik aurkhi-
tzen.
7 Juduek ihardetsi
zuten: Guk badugu
lege bat, eta legearen
arabera hil behar da,
zeren duen egin bere
burua Jainkoaren Se-
me.
8 Pilato, hitz horiek
aditu-eta, lotsatu zen
are gehiago.
9 Eta berriz jauregira
sarthu zen, eta erran
zioen Jesusi: Nongoa
zare? Aldiz Jesusek
etzioen ihardetsi.
10 Pilatok erraten
dio beraz: Niri etzaiz-
kit mintzatzen? Ez

lakizu ene eskuan dela zure gurutzefikaraztea, eta ene eskuan dela zure libratzea ?

11 Jesusek ihardetsi zuen : Etzinduke ene gainean ahalik batere, baldin ez balitzaitzu gainetik eman. Hargatik du bekhatu handiagoa ni zure eskuetan ezarri nauenak.

12 Geroztik-ere Pilatok bilhatzen zuen haren libratzea ; bainan Juduak garrasika hari ziren, ziotelarik : Uzten baduzu hori, etzare Zesarren adiskide, ezen bere burua erregetzat ematen duenak, bihurri egiten dio Zesarri.

13 Bada, Pilatok aditu zituenean solas horiek, kamporat ilkhiarazi zuen Jesus, eta jarri zen juye alkhian, Lithostrotos deitzen den tokian, hebrearaz aldiz Gabbatha.

*14 Hura zen* bada Bazkoaren aphaintzeko eguna, seyetako mugatsuan ; eta erran zioten Juduei : Huna zuen errege.

15 Hekiek berriz, oihu egiten zuten : Khen, khen, gurutzefika. Pilatok erraten diote : Gurutzefikaturen othe dut zuen erregea ? Aphez nausiek ihardetsi zuten : Guk ez dugu Zesarrez bertze erregerik.

16 Orduan beraz eman zioten gurutzefika zezaten. Hekiek berriz, hartu eta eraman zuten Jesus.

17 Eta beretzat gurutzea bizkarrean, ilkhi zen Kalbarioa erraten dioten tokira, hebrearaz aldiz Golgotha ;

18 Non gurutzefikatu baitzuten, eta harekin bertze bia, hainditik eta hunainditik, Jes berriz erdian.

19 Pilatok bada, eg

zuen iskribuzko ageri bat, eta ezarrarazi zuen gurutzearen muthurrean. Hartan hau zen iskribatua: Jesus Nazaretharra, Juduen Errege.

20 Ageri hura beraz Judu hainitzek irakurtu zuten, zeren hiritik hurbil baitzen Jesus gurutzefikatu zuten tokia. Eta ageria ezarria zen hebrearaz, greziaraz eta latinez.

21 Pilatori erraten zioten beraz Juduen aphez nausiek: Ez ezar Juduen Errege; bainan berak erran duela: Juduen Errege naiz.

22 Pilatok ihardetsi zioten: Iskribatu dudana, iskribatu dut.

23 Soldadoek beraz, gurutzefikatu zutenean Jesus, hartu zituzten haren soinekoak eta soingainekoa, eta berezi zituzten lau aldetara, soldado bakhotcharentzat zathi bat. Soingainekoa ordean josturagabea zen, gainetik beherera batean ehoa.

24 Beren artean erran zuten beraz: Ez dezagun hauts, bainan zorthe arthik dezagun, hean norena izanen den; bethe zadien Iskritura, zeinak baitio: Phartitu dituzte ene soinekoak beren artean, eta zorthera arthiki dute ene soina. Eta hala egin ere zuten soldadoek.

25 Bada, Jesusen gurutzearen aldean zauden haren ama, eta haren amaren ahizpa, Maria Kleophasena, eta Maria Magdalena.

26 Jesusek ikhusirik beraz ama, eta aldean maite zuen dizipulua, erraten dio bere amari: Emaztekia, horra zure semea.

27 Gero dizipuluari
erraten dio: Horra
zure ama. Eta ordu-
danik hartu zuen dizi-
puluak bere ganat.
28 Gero, Jesusek bai-
tzakien gauzak oro be-
theak zirela, Iskritura
ere bethe zadientzat
erran zuen: Egarri
naiz.
29 Bada han bazen
untzi bat minagrez be-
thea. Soldadoek berriz,
hisopozko makhila ba-
ten muthurrean chu-
chendurik esponja bat
minagrez asea, Jesusi
eman zioten ahora.
30 Jesusek hartu on-
doan beraz minagretik,
erran zuen: Akhabo
da. Eta burua ma-
khurturik, eman zuen
azken hatsa.
31 Bada Juduek (a-
phainketa eguna bai-
tzen), gorphutzak etzi-
tezen larumbatarekin
gurutzean egon (ezik
*handia* zen larumbat
egun hura), othoiztu
zuten Pilato, hautsaraz
ziotzoten zangarrak eta
khenaraz zetzan han-
dik.
32 Ethorri ziren be-
raz soldadoak, eta kar-
raskatu zituzten lehem-
bizikoaren zangarrak,
eta harekin gurutzefi-
katua zen bertzearenak
orobat.
33 Bainan Jesusen
gana ethorri zireneau,
ikhusirik ordukoz hila
zela, etzituzten trenka-
tu haren zangarrak.
34 Bainan soldadoe-
tarik batek bere lantzaz
ideki zioen saihetsa, eta
ilkhi zen berehala ur
eta odol.
35 Eta ikhusi izan
duenak egiten du le-
khukotasun, eta egiaz-
koa da haren lekhuko-
tasuna. Eta harek ba-
daki egia dioela, sinhets
dezazuentzat zuek ere.
36 Ezen horiek ger-
thatu dire, bethe zadien

iskribatua dena: Hezurrik phorroskaturen ez diozue.

37 Eta bertze aldi batean iskribatua da; Ikhusiren dute itzatu dutenaren barnea.

38 Horien ondoan berriz, Josep Arimathearrak (Jesusen dizipulua baitzen, bainan ichilikakoa, Juduen beldurrez) Pilatori galdatu zioen utz ziozen eramatera Jesusen gorphutza. Eta Pilatok utzi zioen eskua. Ethorri zen beraz eta eraman zuen Jesusen gorphutza.

39 Aldiz Nikodemo ere, lehembizian gauaz Jesusen gana ethorri zen hura bera, ethorri zen ekhartzen zuelarik mirra aloesarekin baltsaturik ehun liberaren heina.

40 Hartu zuten beraz Jesusen gorphutza eta oihaletan tinkatu zuten baltsamuekin, Juduek ehorzteko duten ohitzaren arabera.

41 Bada, Jesus gurutzefikatu zuten tokian bazen baratze bat, eta baratzean hobi berri bat, zeintan ez baitzen oraino nihor ezarri izan.

42 Juduen aphainketako eguna baitzen, hobia hurbil zelakoz hartan ezarri zuten Jesusen gorphutza.

## XX. KAP.

BADA, larumbat biharamun goizean, ilhun zelarik oraino, Maria Magdalena hobira goan zen, eta ikhusi zuen harria hobitik khendua.

2 Lasterrari eman zen beraz eta ethorri zen Simon Piarresen gana eta Jesusek maite zuen bertze dizipuluaren gana, eta erraten diote: Eraman dute Jauna

hobitik, eta ez dakigu
non ezarri duten.
3 Ilkhi ziren beraz
Piarres eta bertze dizi-
pulu hura eta goan
ziren hobira.
4 Bada, biak lasterka
zihoazen batean, eta
bertze dizipulu hura
aitzinean goan zen
Piarres baino lehenago,
eta lehembizikorik hel-
du izan zen hobira.
5 Eta makhurtu ze-
nean ikhusi zituen oi-
halak lurrean; etzen
hargatik sarthu.
6 Simon Piarres e-
thorri zen beraz haren
ondotik eta hobira sar-
thu zen, eta ikhusi zi-
tuen oihalak lurrean;
7 Eta Jesusen buruan
izatu burukoa etzen
bertze oihalekin, bainan
berez bazter batean bi-
ribilkatua.
8 Orduan beraz bertze
dizipulu lehembizikorik
hobira heldu izan zen
*hura ere sarthu* zen,
eta ikhusi eta sinhetsi
zuen;
9 Ezen etzakiten o-
raino Iskriturak da-
kharrena, Jauna behar
zela hiletarik biztu.
10 Dizipuluak berriz,
goan ziren beraz etche-
rat.
11 Bada, Maria kam-
poan zagoen hobiaren
aldean nigarrez. Ni-
garrez zagoelarik beraz,
makhurtu zen eta be-
giratu zuen hobi bar-
nera;
12 Eta ikhusi zituen
bi aingeru soineko chu-
ritan, jarriak, bat buru-
ko eta bertzea oinetako
aldetik, Jesusen gor-
phutza ezarria izan zen
tokian.
13 Aingeruek erraten
diote: Emaztekia, zer-
gatik egiten duzu nigar?
Ihardesten du: Zeren
eraman baitute ene
Jauna, eta ez dakit non
ezarri duten.
14 Hori erranik, gi-

belerat itzuli eta ikhusten du Jesus chutik, eta etzuen ezagutzen Jesus zela.

15 Jesusek erraten dio: Emaztekia, zergatik egiten duzu nigar? nor bilhatzen duzu? Harek, ustez baratzezaina zela ihardesten dio: Jauna, zuk khendu baduzu, erradazu non ezarri duzun, eta eramanen dut nik.

16 Jesusek erraten dio: Maria. Harek, itzulirik ihardesten du: Rabboni, erran-nahibaita Nausia.

17 Ez ni hunki, dio Jesusek, ezen ez naiz oraino igan ene Aitaren gana; bainan zoaz ene anayetara eta erroezute: Igaiten naiz ene Aitaren eta zuen Aitaren gana, ene Jainkoaren eta zuen Jainkoaren gana.

18 Maria Magdalena *goan* zen, dizipuluei berriaren eramatera: Ikhusi dut Jauna, eta hunelako solasak erran darozkit.

19 Egun hartan beraz, larumbat biharamunean, arratsa zelarik, eta Juduen beldurrez atheak hertsiak zirelarik dizipuluak bilduak zauden tokian, ethorri zen Jesus, eta erdian baratu eta erran zioten: Bakea zuei.

20 Eta hori erran ondoan, erakhutsi ziozkaten eskuak eta saihetsa. Dizipuluak beraz bozkariotan sarthu ziren Jauna ikhusirik.

21 Eta erran zaroeten berriz: Bakea zuei. Ni Aitak bidali nauen bezala, nik ere bidaltzen zaituztet zuek.

22 Horiek erranik, haize egin zuen hekien gainera, eta erran zioten: Har zazue Izpiritu saindua.

23 Bekhatuak bar-

khatuko diozkatzuetenei, barkhatuak izanen zaizkiote, eta idukiko diozkatzuetenei, izanen zaizkiote idukiak.

24 Bada, Tomas, hamabietarik bat, Didimo deitzen zutena, etzen hekiekin Jesus ethorri zenean.

25 Erran zioten beraz bertze dizipuluek: Ikhusi dugu Jauna. Harek aldiz ihardetsi zuen,: Non ez ditudan ikhusten haren eskuetan itzeen zilhoak, eta ez dudan ene erhia ežartzen itzeen tokian, eta ematen ez dudan ene eskua haren saihetsean, ez dut sinhetsiren.

26 Eta handik zortzi egunen buruan, Jesusen dizipuluak barnean ziren berriz ere, eta hekiekin zen Tomas. Jesus ethorri zen atheak hertsiak zirelarik, eta *eman zen hekien er*dian, eta erran zioten: Bakea zuei.

27 Gero erraten dio Tomasi: Ekhar zazu hunat zure erhia, eta ikhusatzu ene eskuak, hurbil zazu zure eskua eta ezar zazu ene saihetsean; eta ez izan sinhetsgaitz, bai ordean zin.

28 Tomasek ihardetsi eta erran zuen: Ene Jauna, eta ene Jainkoa.

29 Jesusek erran zioen: Ikhusi nauzulakoz, Tomas, sinhetsi duzu: dohatsu ez ikhusi eta sinhetsi dutenak.

30 Bada, Jesusek egin izan du bere dizipuluen aitzinean bertze asko sendagailla, liburu huntan emanak ez direnak.

31 Haukiek aldiz iskribatuak izan dire, sinhets dezazuentzat ezen Jesus dela Kristo, Jainkoaren Semea; eta sinhetsirik, haren izenean izan dezazuen bizitzea.

## XXI. KAP.

GEROZTIK Jesus
agertu zitzayoten
berriz dizipuluei Tibe-
riasgo itsas-hegian.
Bada, huna nola agertu
zen :
2 Elkharrekin ziren
Simon Piarres, eta To-
mas, Didimo deitzen
zutena, eta Nathanael,
zeina Kana Galileakoa
baitzen, eta Zebedeoren
semeak, eta haren dizi-
puluetarik bertze bia.
3 Simon Piarresek er-
raten diote: Banoha
arrantzatzera. Hekiek
ihardesten dute: Hel-
du gare gu ere zurekin.
Eta ilkhi ziren eta igan
untzi batetara, eta gau
hartan etzuten deusere
harrapatu.
4 Bada, goiza ethorri
zenean, Jesus agertu
zen ur hegian ; dizipu-
luek hargatik etzuten
ezagutu Jesus zela.
5 Jesusek erran zio-
ten beraz: Haurrak,
baduzue jatekorik ba-
tere ? Ihardetsi zioten
ezetz.
6 Jesusek erraten di-
ote: Arthikazue sarea
untzitik eskuin, eta
atzemanen duzue. Ar-
thiki zuten beraz, eta
etziren gehiago haren
biltzeko gai, arrainke-
taren handiz.
7 Orduan Jesusek
maite zuen dizipulu
harek erran zioen Piar-
resi: Jauna da hori.
Simon Piarresek aditu
zuenean Jauna zela,
jauntzi zuen soina, ezen
biluzia zen, eta jauzi
egin zuen itsasora.
8 Bertze dizipuluak
berriz, sarea arrainekin
herrestatuz, ethorri zi-
ren untzian, ezik etzi-
ren leihorretik urrun,
bainan berrehun beso-
tan bezala.
9 Lurrera jautsi zire-
nean beraz, ikhusi zi-
tuzten ikhatzak biztu-

ak, arraina suan, eta ogia.

10 Jesusek erran zioten: Ekharrazue orai hartu duzuen arrainetarik.

11 Simon Piarres goan zen, eta leihorrera herrestatu zuen sarea, zazpitan hogoi eta hamahirur arrain handiz bethea. Eta hambat zen arren, sarea etzen lehertu.

12 Jesusek erraten diote: Zatozte, jan zazue. Eta jaten hari zirenetarik nihor etzen ausartatzen galdatzera: Nor zare zu? baitzakiten Jauna zela.

13 Hurbiltzen da Jesus, hartzen du ogia eta ematen diote, eta arrainkia orobat.

14 Hau izan zen hirugarren aldia Jesus bere dizipuluei agertu zitzayotena, hiletarik biztu zenaz geroztik.

15 Jan dutenean beraz, Jesusek erraten dio Simon Piarresi: Simon, Joanesen semea, maite nauzu haukiek baino gehiago? Ihardesten du: Bai, Jauna, badakizu maite zaitudala. Jesusek erraten dio: Alha zatzu ene bildotsak.

16 Erraten dio berriz: Simon, Joanesen semea, maite nauzu? Harek ihardesten du: Bai, Jauna, badakizu maite zaitudala. Jesusek erraten dio: Alha zatzu ene bildotsak.

17 Hirugarrenenean ezraten dio: Simon, Joanesen semea, maite nauzu? Piarresek minean hartu zuen, zeren hirugarren aldiko galdatzen zioen: Maite nauzu? eta ihardetsi zioen: Jauna, gauza guziz jakintsun zare; badakizu maite zaitudala. Jesusek erran

zioen: Alha zatzu ene
ardiak.
18 Egiazki, derratzut,
egiazki, gazteago zine-
nean, zeronek tinkatzen
zinduen zure gerria,
eta bazinoazen nahi
zinduen alderat; bai-
nan zahartu izanen za-
renean, hedatuko ditu-
tzu eskuak, eta bertze
batek tinkatuko eta
nahi ez duzun tokirat
eramanen zaitu.
19 Bada, erran zuen
hori, adiarazteko zer
heriotzeren bidez be-
harko zioen Jainkoari
ospe atheratu. Eta
hitz horiek egin-eta,
erran zioen: Jarraik
zakizkit.
20 Itzuli zen Piarres
eta ikhusi zuen ondo-
tik heldu zela Jesusek
maite zuen dizipulua,
azken afarian Jesusen
bulharren gainera egotu
zen hura, eta zeinak
erran baitzuen: Jauna,
*nor da salduko zaituena?*
21 Piarresek hura i-
khusi zuenean beraz,
erran zioen Jesusi:
Hau berriz, Jauna, zer
eginen da?
22 Jesusek erraten
dio: Hori nahi dut
hola egon dadien, ni
ethor nadien arteo; zer
dihoakizu zuri? Zu
behintzat, jarraik za-
kizkit.
23 Solas hau atheratu
zen beraz anayen arte-
an, etzela hilen dizipulu
hura. Jesusek ordean
etzioen Piarresi erran:
Ez da hilen; bainan:
Hori nahi dut hola e-
gon dadien, ni ethor
nadien arteo; zer zai-
tzu zuri?
24 Dizipulu hura da,
haukietaz lekhukota-
sun bihurtzen duena,
eta haukiek iskribatu
dituena; eta badakigu
zina dela haren lekhu-
kotasuna.
25 Bada, oraino ba-
dire bertze hainitz

gauza ere Jesusek eginak; zeinak iskriba baleitez bat banazka, ez baitut uste munduak berak ere iduk ahal letzazkeela iskribatzeko litazkeen liburuak.